# IPUI ONAC,

CEINTZUETAN ARQUITUCO DITUZTEN EUSCALDUN NEÇAZARI, TA GAZTE GUCIAC ERACASTE EDERRAC BEREN VICITZA ZUCENTZECO.

Ematen ditu Euscaráz arguitará ume eta necazarientzat

*D.ª VICENTA ANTONIA MOGUEL ta Elguezabalec.*

DONOSTIAN:

Antonio Undiano liburuguillearen echean. 1804 garren urtean.

*Bear becela.*

*Etenim hæc conficta arbitror... ut effictos nostros mores in alienis personis, expressamque imaginem vitæ quotidianæ videremus.*

Cicero pro Sexto Rosc. Amer. 16.

# DON VICTOR MUNIBE

## TA ARANGUREN-GORI,

*Osasuna, paquea, ta urte luceac.*

Nere Zaldunchoa: Artu ditudan ezquero gogoac arguitará emateco *Ipui onén* liburucho bat, erabaqui bear nuan nori bere esquintza eguin. Buruari neque gogor ta gogaitcarriric eman gabé, norí asmatzen, zu izan bear ciñan, nic autu bear nuena. Ipuioc atera nai ditut gaztecho, ta necazarientzat, edo Vizcaian esan oi dan becela, nequezaleentzat. Zure urte la-

burrac gaztechoen artean ipintzen zaituzte. Nai banu aguertu zure andiquitasuna jatorriz, ta zure Asaba jaunen arguitasuna goi goi ipiñi, erraz izango nuque aitatzeaz bacarric Munibeac, Idiaquezac, Ugarteac, Arancibiac, Sasiolac, Arizagac, Arangurenac, Alabac, ta onelaco beste icen eder ezagutuac non nai. Zure Asaben artean arquituco nituque Loiolacoac ere, ta alcartzen, ta odoltzen cerala lurreco lau alde, ta ceruan ere ezagutua dan San Ignaciorequin. Au ala da; baña itz alperrac dira onelacoac

zuretzat. Necazari baten semecho bati eguingo diozu zuc agur ain gozoa, nola Erregue batenari, ta orobat da zuretzat abarcadun mutilchoa nola, zapata bichituz estalia.

Badaquit jatorriz becela dacartzula necazariei asco nai izatea, ta arpegui gozatsua eracustea. Ezagutu zutenac icen oneco zure Aita-Aita Jaun D. Xavier Maria Munibe ta Idiaquez-co, ez daucate azturic bere lautasuna necazari gucientzat; nola ematen cioen escua estu estu, ta laztantasunez baserritarrai. ¡ Cembat bere er-

renteroc esan oi zuten, ez degu iñor, gure nagusiac baño agur gozoagoric eguiten digunic! Bere atseguin gucia zan jaquitea ondo vici cirala bere errenteroac, ta gogoan cerabillen, oen icerdiac diru guciac baño gueiagora igoten zuela. Onegatic zuten ain maite, ta ez zuen guchiago irabaci alde onetatic bere icen ona zabaltzeco, bere jaquituria, ta beste doai andietatic baño.

Berriz zure Aita jaun, ta nere onguille D. Antonio Maria Munibecoc bularretic becela dacar necazarien maitetasuna.

Cein sarri enzun oi dan Marquinan, ta bere inguruetan, Conde Peñaflorida coac baserritarrai eguiten dioen, *agur ederra*! Bestetic? ez da vici bere vorondatéz, ta auquera osóz baserritar eguinda becela? Bai: Erri andietaco ospé, iscambilla, ta cateatasunac baño naiago du Munibeco Jauregui baserrituan lauqui egunac igarotzea, andiusaiac alde batera largaric, ó nere zaldunchoa! jostatzen da zurequin, ta zure arreba, ta bere alaba biquiequin; jolasez becela, aguiraca, muquertasun, ta cigor gabe eracasten dizutela

iracurten, ta izcribitzen. Cein icusteco ederra acitegui, ta icaslecu eguinda Munibeco Echea, ta zure arrebacho Maria Pilar, ta Maria Carmengo Amandrearen aldamenean berai ditzaizquen escu-bearretan.

Berriz ¿ nolacoa zure poza ecustean chalchoac jostatzen zelaian, izutu ta gogaitic eguin gabe enzuten dituzunean idi, ta beien orroac? ¿ Bildotsac dabiltzanean parlanzuan, nolaco farra gozoac? Zoacenean gaztañadietara, ta arquitzean perrechicuac ¿ nolaco pozarequin ez zoaz Aita jaunari esatera,

topatu ditut *urdin* eder bat, ta *urrich* bi bareac jan gabeac? Au bai dala vicitza categabe, ta erri andietaco lotutasun, edo labañqueriaric ez duena!

Orain bada, zu cera guciz Ipui zalea. Aua zabalic enzuten egoten cera aspertu gabe Aita jaunac contatzen dizquitzunean. Leiatzen cera zeu ere buruz icasten, ta besteai guero contatzen. Berriz eusquera eguiten dezu, dala Guiputzen, dala Vizcaitarren guisan. Gucira zaude eguiña. Beraz alde gucietatic zor nizun zuri liburu onen esquintza, edo presente

labur au. Arquituco dezu canta gaitzat catu eizariaren Ipui zortzicoan berariz ipiñia. Badezu norc zortzico berri bat soñuan atera, ta irutzen bacera cere arreba gaztecho aitatu ditudanequin, cein ederqui irtengo duen catuaren zortzicoac. Aita jaunac biolinarequin laguntzen dizutela! Arzazu bada nere vorondate onaren aguermena, ta guelditzen da zure aguindura, zure escuchoai muñ eguin naiz.

*Vicenta Antonia Moguél ta Elguezabal.*

## IRACURLE EUSCALDUNARI.

BAdaquit, enzunaz beste gabe, nescach gazte baten icena dagoala ichatsiric liburucho onen aurquean, jardungo dutela siñuca ez guchic, diotela beren artean, iñoren lumáz janci nai duela belachiquiac; au da, besten bearrac artu nai ditudala neretzat: ez dago quiola nescacha bati bururic ausitzea liburuguiñen: asco duela gorua, naiz jostorratza zucen erabiltzea. ¿Nola nic siniserazoco diet ascori, eusqueratu ditudala erdaldun jaquitunac arguiratu dituzten Ipuiac? ¿Nolaco arrotasuna berriz latiñezco itzcuntzarequin liburu onen asmoa aguertzea? Orretararaco bear litzaque jaquitea Eusquera, Gaztelania, eta Latinezco iru izcuntzac. Cein gauza sinisgaitza nescacha bategan!

Naiz sinistu, naiz ez, esan bear det, gaztechoa nintzala iracurri ta azaldu oi nituela Fedroren latiñezco Ipuiac; artu oi nuela atseguin guciz andia enzunaz Chacur, Otso, Aiceri, Ollar, Abere, Lau-

oñeco, ta Egaztien itzqueta alcarren artecoac. Zortzi urte nituenean ecusiric nere neba, edo anaia icasten asi zala gure Osabarequin Latiñezco izquerea, jarri citzatan buruan icasi bear nuela nic ere. Ala, buruari neque gogorric eman gabe, loari bere orduac emanda, ta cigor zaurigarriaren beldurric ez nuela, jolasez becela, irten nuen nere asmoarequin, Virgilioren itzneurtu, ta apainduetan gozatzen nintzala. Edoceñec daqui Esoporen Ipui latiñéz, ta itz lotu gabeetan daudenac, errazagoac dirala aditzen, Fedro, ta Virgilioren itz lotuac baño.

Umeago nintzanean berriz enzun oi nituen, zoro zororic, ta pozez erotuta, atso ipuiac. Sinisten nituen eguia andi batzuec becela, *Peru*, *ta Mariaren* ipui farragarri, ta sustrai gabeac: enzunac enzunda ere, aspertu ecin nintzan; ta paqueric ematen ez nien atso gaissoai berriz ta berriz esateco alaco ipuiac. Au da aur gucien gaitza, edo zorasuna. Orain bada, ¿ondoric, ta ondorengo onic ez cecarten ipui eroac ambat atseguin ema-

ten bacidaten, nere adinaren arguiabarretan sartu baño leenago, cembat eztituco ez zan nere biotza iracurri nituenean guerora ipui onac? Lenengoan enzuten nituen algaraz, ta pozez Aiceriaren asmo, gaiztaqueria, ta asco jaquiñac; bere berriqueta, ta jardunac. Baña azquenean iracurriric ipuiaren ateraquizun, ta ondoren ederra, ta nencusanean, oscol, edo azal zatarra ausiric, barruan cegoan mami gozoa, oroitzen ninzan erle dontsuaz, ceñec lora, eder ez diradenetatic ere, atera oi duen eztia, ta eguin guero erlaunceán abarascá, edo abao aurchoen ezpañac gozatzen dituztenac.

Deritzat enzuten nagoala mutilcho, nescachacho, ta necazari ascoren farra, ta algará gozoac iracurri, edo aituaz Ipui oec; ta nola gueroenean issildu ta arrituta becela gueldituco dirán Ipuiaren ondoren adigarriac ecusiric. ¿Norc esan cezaquean, esango dute, certara jo bear zuten Ipui farra eraguitecoac? ¿Cein ederqui adierazoten duten estalqui ederren azpian, andiquiac, chiquiquiac, ta

jaquintsuac berac icasi bear dituztén, ónac izateco, videac!

Esan oi dute ero eroric necazari batzuec, anciñaco egunetan itzquetan cequitela chacur, catu, aiceri, otso, ardi, ta ipuietan ateratzen dirán abere, naiz egaztiac. Baña guchi dirá ain eroac. Laster igarrico dioe adarchoetan dagoala fruta; ta oni oratu bear zaiola, adarchoa baztertuta. Azqueneronz dauden Ipui itz neurtuco, edo versodunac, ez dira nereac, ta bai nere Osaba cerbait ezagunari artuac.

Aitu diot ondò daquian bati, Ipui oec izango dirala guciz onac aztuerazotzeco Necazarien echeetatic Ipui oquer, ta zatarrac, nola sagar ederrac, ta diru berdiñean saltzen daudenean, baztertu ta saldu ecinda guelditzen dirán sagar miñ ta motelac. ¿Norc chori guereci chatarrai beguiratzen dioe dauzcanean escubatera guereci ampollac?

Deritzat ez dala aztutzeco contua Euscararen edertasuna, abere, ganadu, ta egaztien icenetan. Ez dirá nasqui icen uts nola naico, ta naiaz beste gabe asma-

tuac Erdaldunic gueienen guisacoac. Goacen ecustera cer esan nai duen icen bacoitzac, issildu ditecen Euscarari gaizqui beguiratzen dioenac, ta erderatuco ditut.

*Aiz-eria.* Raposo. Ayre pestífero ó maligno.
*Su-guea.* Culebra. Sin fuego, ó el frio.

Cein ederqui esan zan *Frigidus.... latet anguis in herba.*

*Musquerra.* Lagarto. El esquivo de *musu oquerra.*
*Otsoa*, *Oitsoa.* Lobo. El de los altos, ó montañés.
*Artza.* Oso. El de mucha ó gran garra.
*Cata-motza.* Tigre basto. Gato serio ó respetable.
*Zacurra.* Perro grande. De fuerte latido.
*Chacurra.* Perro menor. Ladradorcillo.

Ez da orobat *zauca*, nola *chauca* eguitea: lenengoa da, andiena; bigarrena, chiquiena. Zacurrac esan nai du *zaucorra*, ladrador, ó *zauca* urrean duena.

*Basaurdea.* Jabali. Puerco montés.
*Oi-loa.* Gallina. Sueño en alto.
*Oillarra.* Gallo. El macho de las gallinas.
*Catua.* Gato. El de las cadenas, ó humeado.
*Ardia.* Oveja. Pastador de yerva.
*Auntza.* Cabra. Boca fétida, ò malhechora.
*Aquerra.* Cabrón. Boca torcida, ó mala.
*Erlea.* Aveja. Poblador, ó hacedor de pueblo, de *Erri-eguillea.*
*Erbia.* Liebre. Doble coxera, de *erren-bi.*
*Luquia.* Raposo. El encavernado, ó enterrado en cueva.
*Mozoilloa.* Mochuelo. Gallina seria, ó mocha: la voz *motza* es equivoca.
*Ontza.* Buho. Todo bueno, ó que no daña.
*Ep-erra.* Perdiz. De hermoso corte, ó tal vez *zarpa hermosa*, de *erpe-ederra.*
*Galeperra.* Codorniz. Perdiz de los trigales.
*Ollagorra.* Becada. Gallina sorda.
*Mingorra.* Becacin. De lengua muda.
*Mirua.* Milano. Hila delgado... astuto.
*Gabilaia.* Gabilan. Vuela buscando, de *ega-billa.*
*Astoa.* Asno. De paso lento, de *asti doa.*
*Zaldia.* Caballo. El aficionado al grano, ó el fuerte.

*Zamaria.* Cabalgadura. Cargador.
*Cecena.* Toro. El erguido.
*Beeia.* Baca. Cabiz baxo, ó la abaxada.
*Iguela.* Rana. Nadador.
*Ugarasiüa.* Rana. Nadador vocinglero.
*Erroïa, Belia.* Cuervos. De lo alto y baxo.

Belá mota bi dirá, batá betí goietan dabillená inoiz sorobeetara jetsi gabe, ta bestea jetsi oi dana. Lenbicicoaï deitzen zaizte *Erroïac*, bigarrenai *Beleac*. Ala dira ezagunac icenequin Vizcaian.

*Zapoa.* Sapo. El zambo, ancho, ó aplastado. De aqui *zapaldu*.

¿Cer gueiago esan diteque, zorri, arcacusu, ta chimicha citalac ere badituzte icen azaldariac?

*Zorria.* Piojo. Deuda, ó tributo. Lo es de nuestra miserable naturaleza.
*Arcacutsua.* Pulga. Insecto ensuciador.
*Chimicha.* Chinche. Pelliscador.

Ez ciran oec igarotzecoac Ipuien liburuan.

Largatzen ditut azaldatu gabe beste icen asco. Au berau guertatzen da belarretan. Nere Osaba jaun, ta besteequin

ere leiatu, edo dentatu naiz onelaco icenazaldatze, edo erdera usaian, *ethimologietan.* ¿Obe ez ote da, emacumea banaiz ere, igarotzea orduac onetan cer *janci-berri* dan gora ta beera aitatzen baño? Jaquiteac ez du eragozten virtute andi batera igotzeco. Santa Florentina, Santa Paula, Santa Brigida, ta beste Santa batzuec, emanac ciran liburuetara. Baciaquien latin ez ece, gueiago ere; ez, eguiaz, egaatzeco arrotasunez, ta jaquin nai utsez, ta bai videac artzeco Jaungoicoagana. Arbezate bada Euscaldunac, nescacha gazte baten emaitza, edo presente au. Gauza onic badago, esandezatela iñorena dala, ez nerea; oquerric badacuste egotzi nere gañera; berdin arteac ez du emango sagarric. Agur onembesterequin.

# IPUI I.ª

## *OTSOA, TA BILDOTSA.*

OTSOA ta Bildotsa elducirán bacoitza bere aldetic Ibai batera ura edateco asmóz. Otsoa asizan edaten goico aldetic, ta Bildotsa uráz beetic. Otsoac ecusiric asizala ura edaten, diotsa ¿Cergatic loitudidazu urá ni edaten nengoan artean? Bildotsac eranzun cion paquéz: ¿Nola diozu ori, zure aldetic badator Ibaico urá ni nagoan beeco aldera? Otso gaiztoac ez enzuna eguinic Bildotsaren arrazoi eder, issilgarriari, esatendio: ¿Cergatic lotsa galtzen didazu? Cergatic niri gaizqui esan? Ori da Nagusiago bati videgabe andia eguitea. Bildotsac diotsa: Ezdizut nic lotsaric galdu, ez gaizquiric esan. Orduan becoqui chimurtu, ta beguirada aserratu batequin esatendio Otsoac, sei illa bete dira zure Gura-

soac eguinzidala beste onembeste. ¿Nola izanditeque ori, diotsa Bildotsac, gueroago jaioa banaiz? ¿Ceri ta certara dator ori asmatzea? Dan bezela dala, zuc galdudidazu nere lárteguiá belarra janáz, esatendio Otsoac. Bildotsac berriz. ¿Nola ori ere, ortzac irten ezbadidate? Nola jan belarra oy uts ta samurrequin? Ez cedu- canean Otsoac cer eranzun arrazoi ain arguiei, estalquiac quenduric, diotsa, Berrichu citala, ezdaquit cer esan; bai ordea aragui zalea naizala, zure araguiá biguñ ta samurra dala, ta zurearequin apaldu beardedala: au esanda, arrapatu, ta sabeleratu zuen.

Ipui onec esan naidu, gaizto asmatzallen artean eguiac ez duela lecuric; indarrác bacarric aguintzen duela. ¿Cembat onelaco Otso? Asco dira biotz gogorrecoac; diru goseac darabiltza aitzaquia, ta esesio billa, edateco Necazari argalaren odol, edo bearra. Onegatic

*Eguia iduquizazu gauza alpertzat*
*Gaizto asmodun, ta asco jaquiñentzat.*

IPUI

# IPUI II.

## *Zacurrá, ta Ardiá.*

ZAcur batec escatu cion asmo gaiztóz ta guezurrez Ardi gaisso bati ogui zati bat, esanáz, berac lenago prestatuciola. Ucatzencion eguiaz Ardi indar gabeac, esatenciola, ¿noiz ta non emancinidan niri zuc ogui gauzaric? Jaiquizan auci gogor bat. Aguertucirán batá ta bestea Aguintari baten aurrera. Zacurrác esatendu, nic on eguingodet nere esana siniste osoa emanbear zaien gende prestu, ta daquienequin igaro zana. Aguintariac dio, ondo itzeguindezu, Zacur erritarra. Zucenduzan au issilchoric billatzera Testigu, edo Aguiritzalletzat Otsoa, Arranoa ta Mirua. Oequin, alcar aituric, joanzan Aguintariaren aurrera, ta diotsa Zacurrac, Ona emen aitzaquia gabeco, ta lotsa andico Testiguac: oec daquite cer igarodan. Esan dezatela. Galdetu cion lenen Otsoari, eguia zan edo ez, Zacurrac emanciola oguia Ardiari. Bai, eranzunzuén Otsoac; neuc daquit emanciola aurréz, ta prestatzez, guero beste ambeste biurtzeco zorrez.

Arranoac esanzuen, Ala da; eta ¿nola ucalezaque Ardi guezurtiac? Milia birao eguingo ditut bear bada. Irentsinazatela Catamotzac, ala ezbada. Miruac irtenzuen esanaz, Otsoac, eta Arranoac eguia ciotela; ta berac cecusala, bere begui arguien aurrean prestatuciola Zacur prestuac oguia Ardi cital ucatzenzuenari. Ardi gaissoac cer eguin? ¿Nola arpeguia aguertu etsai bere aragui zaleen esanac guezurtatzeco? Chist bat eguitera aizartu ez zan. Orduan Aguintariac emanzuen *Autu* au: *Zacurrac on eguin duelaco bere esana Aguertzalle, edo Testigu zucen, ta lotsa andicoequin, ta Ardiac ecin duelaco, guezurra diotela aguertu, nola issil egotea dan bestetic aitortzea, aguintzen da biurtu deguiola Ardiac Zacurrari prestatucion oguia; ezagutua izandidilla Zaçurra eguia zaletzat, ta Ardiac paga ditzala eguin diran çostu guciac.* Ez ceducan Ardi gaissoac zurico errebat ere. Beldurrez ebaquierazozuen bere illea neguaren erraia bazan ere; partilduzan Artillea Aguintari, Zacur, Otso, Arrano, ta Miruaren artean negu gogor bat otzez igaro bearzuela Ardiac.

Ipui

Ipui onec esan naidu, guizon gaizto, ascotaco, ta indartsuac billatzen dituztela béren guisaco lagunac, ta eguin calte asco argal, oben gabeco, ta itz eguiñaz gàizquiago irtengo duteenetan: larga oi dituztela larru utsean, ta gorrian bérac ederqui jancitzeco. Obedala auciric artu gabe lenengotic escatzen diotena ematea, gueroenean costu guciequin ematea baño. Ardiac eraman balu aurrera aucia beste Aguintari Nagusiago baten gana, ez ziran bere ille guciequin paquetuco bere etsaiac. Aragui zaleac izanic, eramango zuten mamia berá, illé ta guci. Icasi bearda Ipui onequin ebaquitzen auciac mugonez, beranduagora larga gabe. Obe da bear orduan escu atz bat ebaqui, guero escutur gucia baño. *Auzi zalea, eche ondatzallea.*

## IPUI III.

### *Chacurra, ta Aragui zatia.*

Chacur batec bere aoan aragui zati bat ceducala, igaro nai izan zuen Ibaia batetic bestera. Iguerian cijoala, ecusizuen uretan aoan zeramanoquela zatiaren queriza,

riza, ta beguitandu citzaion zala benetaco araguia. Damu ematencion ez arrapatzea; ta azturic aoan ceramanaz, murguildu edo mus eguinic uretan, dendatu zan arrapatzera. Idiqui zuen orretaraco aoa; erori citzaion aoan ceducan araguia; queriz utsari colpe eguin da, ez zuen ecer atera, ta galduzuen berea. Abiatu zan amorruz esaten ¿ cerc erabilli nau gueiagoren billa? Zori gaiztoan galdu det nerea.

Ipui onec esan naidu paquean gorde bear degula garbiro deguna. Galdu oi dala vide onez dagoana, gueiegui iduqui naiz. Obe dala, esan oi dan bezela, echachori, edo curroe bat escuan, Arrano egatua baño: Gucia billatzea dala gucia galtzea: bacoitzac eutsi beardiola bereari, ta larga iñorenari.

## IPUI IV.

### *Leoia, Beia, Auntza, ta Ardia.*

Esop. Fab. IV.

ANdi ta chiquien arteco partilla, ez da inoiz berdiña. Ala da esana, ta ala izana, eracastendigun becela Ipui eder onéc.

Beia,

Beia, Auntza, ta Ardia alcartu ta lagunducirán bein Leoi batequin eizan arrapatzenzana alcarren artean partiltzeco. Basoan cebiltzala, arrapatuzuten Basauntz bat. Lau guera, esanzuten Leoyez beste irurac, ta laurendu beardegu Basauntz au. Gueldi, gueldi, dio Leoyac. Naiz ni Abere gucien Buru, ta Nagusia: lauren bat zor zait alde onetatic: bigarren laureña ere neuri dagoquit, naizalaco sendoena: irugarrena ecin iñorc quenducodit zuec baño ariñago ebilli naizalaco, ta nigatic izan ez balitza, igues eguingocizuten Basauntz onec: laugarrenari icutzendionac, jaquin bearcodu, izango nauela ni bere etsaya. Beldurrac issilducituen beste irurac, ta icasizuten urrengoraco ez laguntzea, ez burua bat eguitea Leoy sendo ta arroarequin.

Ipui onec eracastendioe guizon argal, mé, ta necazariei, ez burua bat eguitea beren artu emanetan berac baño andiagoequin; oec badirá arroac, ascojaquin, ta oquerrac. Nequea izangoda argalentzat; irabacia sendo dirudunentzat. Oec guicenducodira necazaria argaltzendan demporan.

*Laguntzat arzazu berdiña:*
*Andiagoa izangoda calteguiña.*
*Naibadezu igo goregui,*
*Jetsi bearcodezu beregui.*

## IPUI V.
### *Otsoa, ta Curulloa.* (Grulla)

CEgoan bein, sarri becela, Otsoa araguia jaten, ta catigatucitzaion ezurra eztaarrian. Ito ecinic cegoala icusizuen zorionez Curulloa. Atoz oná, diotsa Otsoac; lagunzaquizquit arren. Zuz dezu lepo lucea igarocodezu mocoa nere eztarriraño; ta ala ateracodidazu gatigatuzatan ezurra. Ori eguiten badidazu, ez naiz inoiz aztuco; izangonaitzatzu esquertsu ta onguiña; ezagutucodet zuri zorco dizudala nere vicitza; izangoguera adisquide bioc, ta nere bearrean jartzen bacera, lagunducodizut beti, baita eman ere bearsari, edo aloguer ona. Sinistucituen Curulloac Otsoaren esquintza, nora ecean, edo ecin bestez eguinciozcañac. Zabalduzuan Otsoac aba; sartucion Curulloac bere mocoa eztarriraño, ta ateracion

ezur-

ezurra. Onembesterequin gueldituzan Otsoa gaitz gabe, ta osasun onean. Curulloac esatendio: Emaneguidazu nere bearsari, edo aguindudidazun aloguera. Otsoac ecusizuenean burua sendaturic, ta irriscutic irtenda, eranzutendio. ¿Ez cera lotsa niri aloguera escatzeaz? Zure vicitza egon da nere ortzetan; oec estutu banitu nic, zure lepo lucea nere aoan cegoanean, ¿cer izango zan zuzaz? Esquerrac eman zaizquidatzu nere on eguiña gatic. Nai izan banu, nere sabelean egongo ciñan orain, ta zaude viciric nere oneguitasunez, ta urrengoan gorde ezazu burua onelaco irriscutic. Onembesterequin issilduzuen Curulloa Otso esquergabeac. Au da emancion bearsaria.

*Gaiztoac ez daquite eguiten onic,*
*Ematen ere ez iñori esquerric.*

## IPUI VI.

### *Guizona, ta Suguea.*

NEguaren erraîan otz gogorren artean, izozturic ceudela bazterrac, Guizon erruquior ta biotz biguñeco batec

tec artu zuen echean Suguea; palagatzen zuen aleguiñez; ematencion eznea, ta sucaldeco zocondoa berotucidin. Eldu zan Udaberria, ta nola ondo viciaz guicenduzan Suguea, acicitzaion mistoa, edo venenoa, ta jaiquizan usiquitzeco Guizon bere onguilleari. Aserratucitzaion oni: artuzuen maquilla bat, ta diotsa, ortican emendic; zoaz nere echetic urruti, esquer gaiztoco ori. Cer? Nic erruquiric andienarequin eman, negua ondo igarotzeco, toqui ecin obea; jangarritzat eznea, beroteguitzat sucalde bazterra, ta guicen guicen eguinda, premia igarota, gaitz eguin niri? Illco zaitut bertan bereala irteten ez badezu nere echetic. Bai berriz. Issilchoric irten bearrean gaizqui eguin naiaz damutu ta, jasotzendu burua, ateratzén du eztena, ta sartu nai cion bere onguilleari.

*Gaiztoari eguitenzaion mesedea,*
*Eguillearentzat da caltea.*

Ez du onec esan nai Christauac gaizqui eguingoduela on eguiñaz bere etsai lurrecoari. Jesu-Christoc aguintzen digu eranzuteco guc on eguiñequin, gaizqui nai

nai, edo eguindigutenai: escatzeco Aita Cerucoari berac gatic; maite izateco biotzez, izangaitecen bere umeac, ecusiric nola erorten diran euri lurraren ongarriac, gaiztoen ta onen soroetara. Anciñaco esana da, *eguin ondo edoceñi, beguiratu gabe nori.* Ipuiac bacarric esan nai du, nolacoac dirán gaiztó asco; cein esquer galducoac; nola ezagutzaric ez duten eguiten zaizten mesedeac gatic.

## IPUI VII.

### *Echeco, eta Campoco Saguac.*

ERri-eche eder baten vici zan Saguac irten zuen bein campora, jaquin nairic cer igarotzen zan celai ta basoetan. Aurquitu zuen beste Sagu bat inoiz Errian sartu gabea, ta basoan beti aciá. Ondo egonac alcarri emanic, diotsa campocoac, nere lagun berria, atoz nerequin nere eche, edo vici lecura. Esquerrac emanic Erri Saguac, jarraitu cion Basotarrari. Ipiñicion onec bazcari baso guisacoa. Aguertuciran maira aritz aleac, inchaurrac, uurrac, mispillac, chermenac, aranaç, sagarrac, ta cer ez? Adisqui-

quidea, esatendio Errico Saguac, janaria ugari dezu, baña gucia otza, ta sabela indartzen ez duena. Atoz orain nerequin Erri barruco Eche aberats, edo Jauregui eder batera, non vicinaizan nere era gucietara, ta emangodizquitzut janari gozatsuagoac, coipe ta eztia, urdai ta gaztaya, lucaica, cecina, gozoac..... ta cer ez? Andiqui bat naiz zure aldean. Berriquetai sinistea eman da, joanzan Baso Sagua Erricoarequin. Sartuciran Eche andi baten. Echecoac darama dispensa edo jantoquirá, ta eracustendiozca an aguinduciozcanac. Bizarrac coipetu, ta musuac eztituric cebiltzala jaaten, orra non onic onenean sartzen zaien Catu lodi ta arre bat. Echeco Saguac artuzuen iguesa, gordezuen burua zulo ezagutuetan. Basotarra icaraturic cegoan, cer eguin ez cequiala; artzen du igues videa, jarraitzendio Catuac, icutzendio cerbait atzaparraquin, baña zorionez ez zuen arrapatu. Irten zuenean Catuac, biurtu zan Echecoa Basocoaren billa, ta arquituzuen ódola ceriola lepotic, ta beldurrez erdi illic. Esatendio Echecoac, ¿ nola nic

be-

becela igues eguin ez dezu Catuaren queriza ecusi orduco? Contu bada urrengoraco. Abiatzen dirá berriz jaaten; ta onic onenean enzuten da ate guiltzen otsa: igues eguinzuen laster Echecoac; Basocoa cegoan eltze, edo lapico coipea ceucan baten. Aizartu ecinic irtetzen, egon zan an bazterturic. Guiltzera Nescacha ebilli zan batetic ta bestera gauceen billa, ta zorionez ez zan eldu Basocoa cegoan oncira, ta irtenzuen. Biurtuzan Echecoa jantoquira, ta esatendio Basotarrari: ¿Eznizun nic esan irtetzeco, ta igues eguiteco bereala? Ni naiz Soldau zar urteac igaroditudana onelaco irriscuetan. Adisquidea, diotsa Basotarrac, zuretzat janari gozoac, aberats, ta andi echecoac. Ai nere mendi laztana! Ceimbat ceran obea! Ez dezu an Caturic, ez guiltzera Andraric. Jatendet nere basoan eceren beldur gabe. Zaude, zaude, zu emen bizarrac coipetzen, beti aucitan becela Catu, ta Echecoaquin. Agur: banoa ni nere Basora.

Ipui onec ¿cembat gauza on eracasten ote digu? Bacoitza paquetu bearda dui

du-

duiaz, ta duenaz. Igo nai duenac andi gaucen billa, edo lecu goratura, buruco zorabio bat da asco bea jó ta vicitza galtzeco. Beldur ta quezca gabeco vicitza paquetsua obea da, betico irriscu, ta icaran egotea baño. Ez da iñoiz zorionecoa aberats, ta asco duena, paque ta atsecabaric ezac igues eguin badio. Necazari Basotarraren sabela beteago dago arto, castaña, sagar, ta tupin azadunequin, andiqui bat eper, ollagor, ta ollanda samurrequin baño, onec osasunic, edo paqueric ez du, ta arc bai.

*Obe da guichi iduqui, ta paquea:*
*Ondasun ascoc dacar Icarea.*

## IPUI VIII.

### *Arranoa, ta Aizeria.*

ARranoac arrapatu ciozcan bein Aiceriari lurcillo edo leiza baten ceuzcan umeac. Ecusiric Aiceri asco jaquiñac eguin ecingo ciola gaitzic Arranoari, jarraitucion negarréz, ta diotsa palagúz: Egazti beste gucien Erregue cerana, erruquituzaite ni zaz; biur bear dizquidatzu

nere

nere umeac. ¿Certaraco guraso bati emangodiozu onelaco atsacabea? Eranzun cion Arranoac, ago issillic lapur cital ori. Cembat alditan arrapatu diozcac Olla locatuari bere chitachóac bigundu gabe gurasoaren negarrequin? Iñorc ecusi ecin au quirastu gaizto ori. Ala Arranoac eraman cituen Aicericumeac bere abiara, jaten emateco Arranocumeai. Aiceri ascotacoac asmatu zuen su ematea Arranoaren umeac ceuden arbolari. Ecarricituen lastoa, lar igarra, ta sua. Iriciqui cituenean erregarriac, igoten zuen queac gora, jaiqui zan garra. Ecusiric Arranoac erre bearzutela bere umeac abia ta guci, esatendio: Aiceri oquer ta asmaria; garaitu nauzu cere asco jaquiñarequin; itzeli eguizu sua, ta emangodizquitzut cere umeac. Ala biurtu ciozcan calte gabe, eracasten zuela, gueiago balioduela sarri *asco jaquiñ, ta aizartua izateac, indartsu, ta sendoa izateac baño.*

*Daudenac toqui goietan*
*Eror ditezqué beera:*
*Arrotu bear ez guera*
*Zori ordu onetan.*

IPUI

## IPUI IX.

### *Belea, ta Aizeria.*

ITZ labañetan guelditzen diranac, lotsatuac irtengo dute. Ona cer dion Ipuiac.

Bela batec ostu zuen beìn leyo batetic gaztaia, ta eramanzuen arbola gañera. Bacecusen Aiceriac, ta adurra cerion ezpañetati gaztaia jan naiaz. Cerbait ateratzeco asmoz esaten dio arbolaperic. O Egazti ederra. Ez dago zure berdiñic ego dunen artean. Zure belztasunac argui eguitendu. Cembat eta zarrago, ambat eta ederrago. ¿ Eta nor zu baño eguiñagoric corputz ichuran? Baciña beste chori soñulariac becelacoa, cantatuco bacendu Birigarro batec beste, guciac garaituco cinituque. Arroturic Bela eroa Aiceri ascotaco aren erausi labañequin, eracusteco bacequiala berac ere Birigarroac adiña soñua jotzen, idiqui zuen mocoa cantatzeco asmoz. Orra non erori citzaion lurrera arrapatu, ta arbolaratu zuen gaztaia. Oztá jozuen onéc lurra, non arrapatu zuen etorquizunaren zai cegoan Aiceriac, ta

igues eguin cion bere leizara. Jarraitu cion Beleac escatzen ciola bere gaztaia. Aiceriac oñac arinca cijoala eranzun cion: *Ez da astoenzat eztia, ez dec tontoentzat ere gaztaia.*

Ipui onec adierazo nai du, ez zaiela enzuteric eman bear itz labañ, ta astingarriai; guezurra darabiltela ezpañetan, gauden baño goratuago ipiñi nai gaituztenac itz ederrequin. Goitasun, ta alabanza zaleac damu izango dutela azquenean sinistea emanaz asco-jaquiñen berriquetai: bada *Itz labañetan ez eztitu:*
*Buruac goregui ez iguitu.*

## IPUI X.

### *Leoia, Basaurdea, Cecena, ta Astoa.*

ARquitzen zan Leoi Jauna zaarraz gañetic gaissoa, argala, ta aguinte gabea. Urreratu citzaion Basaurdea, ta diotsa aserrez, ta gaitz naiz: Adisquidea, ez zait aztu nola beti zure iguesi ebilli oi nintzan gaztea ciñanean: esturasun gogorretan ipini ninduzun ez guchitan, ta gogoan daducat nolaco zauria eguin cinidan,

dan, ta oñac ariñagoac izan ezpanitu aldapetan, zure sabelean egosia izango nintzan. Au esanda equincion ortz gogorrequin Leoi argalari, ta larga zuen mancatuagoa. Eldu citzaion gueroago Cecena, ta onéc ere eguin ciozcan epai, edo zauri andiac bere adarrequin. Aguertzen da Asto bat, ta jo zuen atzeco oñequin becoquian, ta egotzi zuen lurrera. Eritu, ta ill ecinic odola alde gucietatic ceriola, dio Leoiac negarréz: Ene zorigabea! Nere indar, ta osasunaren jabe ninzanean, urte guchiago nituenean, abere ta lau oñeco guciac beguiratzen cidaten lotsaz, ta beldurrez; nere aurrean egon oi ciraden buruz bera icaraz. ¿Nor aizartu nere arpeguirá beguiratzera? Nere icenaç sartzen cezuen izua baso gucietan. Nere escuan cegoala chit sarri arrapatu ta irenstea, izanic ni biotz biguñeco, ta erruquiorra, largatzen nioen paquean orain banatu naugutenai. Ez nuen iñor iltzen nere gogoz, ta gaitziritziz, ta bai bacarric bear bear nuena, gosea quendu ta vici izateco. Bein baño gueiagotan gorde nioen vicitza ez guchiri, beste gogorragoai eragotziric gaitz
egui-

eguitea. Orain berriz, nacusenean adore, ta aguinte gabe ecertaco ez naizala, dirudi, guciac alcartzen diradela ni banatu, ta eriotza gogorrera eramateco, nere icen enzute andicoa galduric guelditzen dala; bada esango da, Asto char batec egotzi zuen lurrera, ta garaitu Leoi arrotzarra.

Ipui onec eracasten dioe escuarte andico guizonai, beguira deguiotela etorquizunai; ta nola beti izan bear duten errruquitsu, ta biotz biguñecoac, iñori gaitzic eguin gabe. Beldurra ta izua sartuaz ezdala adisquideric eguiten, ta bai amorioz artuaz mendeco, ta beragocoac: ez dagoala lurrean oin locatu gabeco toquiric; gorá berá asco ecusten dirala: bada

*Eguin aurréz adisquideac*
*Premia orduetaraco:*
*Ez da ez ecer ateraco*
*Arturic beldurvideac.*

## IPUI XI.

### *Astoa, ta Chacurchoa.*

Echeco-Jaun batec ceuzcan Astoa, ta Chacurchoa. Ecusten zuen Astoac Echeco-Jaunac Chacurchoari eguiten cioz-

ciozcan palagu, ta ille igortziac, ta nola alzoan arturic ematen ere ciozcan ogui biguñ, ta oquela zatichoac, ta beretzat ez cegoala baicican lasto gogor, ta noiz edo berriz escu bete arto ale. Au cer da? dio abere buru andicoac. ¿ Chacur char ecertaco ezdanac, bearric eguiten ez duenac ambeste asco nai edo estimacio Echeco-Jauna gandic; ni berriz baztertu ta cortaturic bearrean mancatuta jan guchirequin? Dacus, nola Chacurchoac eguiten diozcan pozcariac Echeco Jaunaren bularrean aurreco oñac ipiniric; nola zauca eguinda igoten cion beste batzuetan belaun gañera, ta miazcatzen ciozcala escuac, ta arpeguia. Dio beregan: obetó artuco naute ni ere alaco pozcaria batzuec eguiten badiozcat. Asmatu, ta eguin. Ecusi zueneco Echeco Nagusia era onean artaraco, arrantza batzuec eguinda, igotendio aurreco oñequin bularrera, ta mingañ zatarrarequin igortzi nai cion arpeguia. Astotzarraren pisuaz jo zuen bea Echeco-Jaunac: asi zan au deadarrez morroiai. Ecusi zutenean Nagusia lurrean etzinda, ta Astoaren osticopean, ba-

 natu

natu zuten maquillaca buru andicoa, ta larga zuten erdi illic.

Ipui onec esan nai du, ez dala inoiz sartu bear bacoitzari ez dagoquion lanean. Iratzarriac, eznatuac, ta asco jaquiñac ez diranac, emango dutela atsecabe atseguiñaren ordean.

*Egon bidi bacoitza bere toquian*
*Izan ez daguian naieza sari ordean.*

## IPUI XII.

### *Leoia, ta Sagua.*

LEoia lotan cegoala mendi baten erriberan, urreratu citzaion Sagu asco, ta oen arteco aizartuenac igo cion bizcarrera. Ezagutu zuenean Saguac, nor zan, ta nolaco arriscuan cegoan, escatu cion barcacioa, ta ez ceguiola arren gaitzic eguin; ez ciola bizcarrera igo gaizqui naiz. Bacequian Leoiac, ez zuela ecer ateraco piztia alaco bati gaitzeguiñaz; gaizqui esango zala bazter gucietan bere atzapar portitzac eramaten bacituen Sagu bat apurtzeco. Larga cion bada joaten nai

zuen lecura. Saguiac diotsa, Leoi prestua, esquer andiac ematē dizquitzut gaitz gabe bialtzen nazulaco, ta emen, ta non nai, egongo naiz zuri on eguiteco ecertan albadet. Egun batzuen ondoren erori zan Leoia prestatu cioen laquio baten. Ecusi zuenean bere burua gatigú, ta urratu ecin cituela loturic ceuzcaten socatzarrac, asi zan orroa izugarriac ateratzen. Enzun cituen orroa andiac aitatu degun Saguchoac; ezagutu zuen norenac ciran, ta esturasun gogorren batean cegoala, berari on eguin cion Leoia. Urreratu citzaion ecusteco cer zan; dacus gatigu; ta diotsa, nere onguille prestuia, ez larritu; neu naiz asco zu ateratzeco irriscu orretatic. Ez daducat aztuta cer zor dizudan, nolaco itza eman nizun. Saguchoac igo zuen soca edo gatigu ceducaten locarri sendoetara. Guchica guchica urratu cituen ortzequin. Irten zuen Leoiac calte gabe, ta esaten dio: Zorioneco ordua, ceñean enzun nituen zure escariac, ta larga nizun joaten gaitzic eguin gabe. Cein prestu ta itz onecoa ceran chiquia izanda ere!

Ipui onec esan nai du chiquichoen

bear izaterá etorri ditezqueala guizonic andienac, ta gaitzic eguin ecin dezaqueten ascoc on eguin dezaquetela. Eracasten ere du, esquertsu izaten, ta ez aztutzen artudiran mesedeac.

*Dionac, ez det iñoren bearric*
*Burua daduca galduric.*

## IPUI XIII.

### *Ontza, ta bere Ama.*

GAissoric cegoan baten Ontza, ta sendagarriric ez cegoala beretzat lurrean, erregutu cion bere Amari eguiteco Santuai esquintza, edo promesac bere osasuna gatic. Amac eranzun cion, nere umea, eguingo det escatzen didazuna; baña beldur naiz, enzungo ez nautela Santuac. Oroi zaite, cembat lapurreta eguin ditugun zuc, eta nic Eleiza barruetan; nola loitu ditugun Aldare, edo Elizmaiac.

Ipui onec esan nai du, gaitz andiac eguin dituztenen noraececo, ecin bestezco, ta esturasuñac eraguinico esquintza,

ta

ta escariac, alperrac dirala, leenago garbitzen ezbada biotza. Santuac bere alde, edo bando iduqui nai dituenac, mugonéz, edo leenaz irabaci bear dituela; osasun egunetan atseguin eman bear dioela, estura ordu ta gaissotasunean adisquide onguilletzat iduqui nai dituenac.

*Santuei ondo esan*
*Ta leenaz beren adisquide izan.*

## IPUI XIV.

### *Enadea, ta beste Choriac.*

ENadea, ta Choritegui mota ascotaco bat ceuden beguira Necazari batzuei lino acia ereiten ceudela soroetan. Diotse Enadeac: Nere lagunac, ez vide daquizute certan ari diraden Erella oec; badazaute beldur gabe. Ereingo dute lino-acia lurra achurtu, ta cimaurturic. Lino belarra aci, ta igartu didinean, gabicotu, charranchatu, ezpatatu, apaindu, gorutu, ta arituta, eguingo dituzte gu arrapatzeco sareac. Mugonez oroitu bear guerade: berandu dator sendagarria, gaitzac in-

indarrac artzen baditu. Arzazute nere gordevidea. Goacen gucioc bat batean soroetara, acia lurrera bota, ta Achurlari oec alde eguiten dutenean, jango degu ezarri duten acia; jaioco ez da lino-belarric; eguingo ere ecin dute sareric. Ala gordeco ditugu gueren buruoc. ¿ Cembat chori erori ote dirá sareetan? Beste chori bildu ciranac farra eguiten cioten galanqui, ta esaten dioe: ¿ Enada gauza ez, beldurti, icaracor, ta biotz gabea, etorquizun urrutico, ta bear bada inoiz izango ez diranac, emango dizute ambeste larritasun? Ondo buruzalea cera. Eguizu nai dezuna; berdin ez diogu guc gueren buruai orrelaco lorric eman nai. Ez? diotse Enadeac, gogoango dezute noiz edo noiz. Or compon. Ecin nic bacarric jan nezaque erein duten acia: igues eguingo det soro, ta landetatic echeetara. Eguingo ditut abe arteetan nere abiac; acico ditut umeac; eracatsico dioet non vici. Urrengo urtean cebillela Enadea ibai batean goitic beerá, ta beetic gora egaa, ecusi cituen alboco soroetan chori asco sareetan sarturic indarca irten nai, ta irten ecinda. Chori

oen

oen artecoac ciran ormachori, edo curro-iac, pinchoe, chirrisquilla, amillots, che-pech, birigarro, zozo, bulargorri, ta es-quillasotzarrac. Ecusi ciradenean ala cati-gú, ta an cebillela Enadea catea gabe, esaten zuten negarrez: ¡Ai sinistu baguiño Enadeari! Igarri cion cer guerta cite-quean. Eguin baguenu orren esana, ez guiñaden ecusico gaur esturasun onetan. Galduac guerá bada, leenaz gorde videac artu ez guinituelaco.

Ipui onec esan nai digu, ez degula izan bear buruirichicoac; artu bear dirala ja-quintsuen zucenvide, edo couseju onac; ezpacere gogoango degula noiz edo noiz, ta eguingo degula negar catea, ta sare chaarrac urratu ecin dituguneau.

*Izan bada aurrez beguiratua,*
*Etorri ez didin guero damua.*

---

Hasta aqui se han sacado las Fábulas mas acomodadas á la capacidad y genio de los niños, y vulgo labrador, del Libro I° de Esopo. Las siguientes se hallan en el Libro II°

IPUI

## IPUI XV.

### *Lapurra, ta Eche-chacurra.*

LApur bat cebillen gaváz gauza asco ostutzen; ta eldu zan aberats baten echera. Irten cion atarira Zacur ora andi ta eche zai egoten zanac, ta diotsa: ¿Cer dacartzu oná calteguin gaizto orrec? Eranzun cion Lapurrac: Ago issillic, to ogui zati bat, ta ez eguic zaucaric, ez usiqui ere niri. Diotsa Zacurrac, ¿ematen didazu ogui au ondo naiz, edo zure estalguilla izan nadin? Eranzuten dio Lapurrac, ematen dizut issill-saritzat, zuc salatu gabe sartu nadin echean, ta eramateco zuc bear ez dituzun diru, ta beste gauzac. Baña diotsa Zacurrac, ¿norc emango dit niri vici naizan arteco oguia iltzen badidazu nere Jabea, edo eramaten badiozcatzu dauzcan diru ta beste ondasunac? ¿Nai cenuque oraingo ogui pusca bategatic galdu dezadan vicitza gucico oguia? ¿Emango ciniquet zuc guero bear dedana? ¿Ez dezu erruquiric guizonentzat, biotz gogorraren jabea cera oentzat, ta izango ote cerá biguñago neretzat? Ez diot

diot nic oguia ematen didanari dollorqueria, ta issil-saltzeeric eguin nai; eta bai gorde berá ta echeco gauzaac. Ala bada zoaz laster etorri cerán vidèetatic, nai ezbadezu nic emen nere ortzequin zu apurtzea. Ez da nere eztarritic lapur oguiric igaroco.

Ipui onec adierazo nai du, ez dala inoiz lapurren estalguille izan bear. Morroi, ta mirabeac gorde bear dituztela contuz echeco gauzac, ta ez eche lapur izan, ez eche lapurrei lagundu. Oguia ematen duenai zor zaiola leialtadea, ta bearra eguitea.

*Eracasten digu Chacurrac*
*Ez estaltzea Lapurrac.*

## IPUI XVI.

### *Eiza-chacurra, ta bere Jabea.*

Elzari batec ceucan Erbi-chacur, gaztea izan zan artean lagundu ciona guciz ondo bere eizan. Zaartu, astundu, ta ortzgabetu zan Chacur gaissoa. Guciaz ere arrapatu zuen Erbi bat, au lotan cegoala. Baña nola ortzac erori citzaicon, eguin-

eguinalac eguinda ere, ecin iduqui izan zuen Erbia, ta indarca cebiltzala igues eguin cion. Bere Jabe Eizariari aserratu citzaion aguitz, ta aguiraca gogorrez diotsa: Chacur zarra, certaco zaitut nic nere echean, oguia alperric jateco baicic? Ez cera ecertaco gauza. Esaten da, eranzun ciola ederqui Chacur gaissoac: Jauna, urte ascoac zartu naute, ta dacusan becela, ez zait ortzic ere guelditu. Noiz bait, nere urte loratuetan bear eguin nion; nere videz ill cituen Erbi asco. Orduan esan oi zuen arro arroric, ez ceducala iñorc berorrec becelaco Erbi-chacurric. Diru asco gatic ere ez ninduen salduco. Berriz orain zapaltzen nau aguiraca: ematen didan oguia, dá damuz, ta vorondate gaiztoz; poztuco litzaque illic banengo: ¿Cer eguin dezaquet bada zartu banaiz? ¿Nola nic urteac atzeratu, ta indar berriac artu? Oroi bidi nere gaztetasuneco eguicariaquin; erruquitu bidi nere ecina gatic; obe nuque len becelaco oñac ta ortzac banitu; bada biotza lengoa det.

Ipui onèc eracasten du arguiró, gazte egunetan bearguiña izandanari, ez zaiola era-

eracutsi bear muquertasunic, guerora zartzan egon baño besteric ecin duenean. Echeco buruac artu bear dituztela ondó, ta erruquiz morroi, ta mirabé, zaartu artean bearguiñac izan diranac, ez bota campora ateric ate oguia billatzera. Eta arrazoi gueiagorequin umeac bear diotela lotsea gorde, amorioz itz eguin, arpegui oná eracutsi, ta laztantasunez beguiratu guraso zaar bearric ecin dutenai.

*Zaar necatuei ondo beguiratu;*
*Bear eguiñac ondo saristatu.*

## IPUI XVII.

### *Erbiac, ta Iguelac.*

EGuin zuten bein Erbiac beren artean batzár, edo bilcuia, ta igaro cituzten itz oec: ¿Cer da guri guertatzen zaiguna? Egun on bat ez daucagu: beti vici guera quezca gogorrean etsaiz inguraturic. Chacur ta guizonac gure billa dabiltza, ala basoetan, nola soro, ta ibarretan. Gorde naiagatic buruac otatza, guisasti, ta toquiriç ezcutuenetan, arquitzen gaituzte

tuzte chacurrac oñatzetatic. Jesten baguera garitzetara, ecin jan degu ecer beldur gabe. Gaveraco ere baditugu basochacurrac, Aiceriac, ta oec dirá Eizariric gaiztoenac. ¿Cembat gure lagun erori dirá Chacur, ta Aicerien ortzetan? ¿Cembat beingoan iltzen dituzte guizonac erremienta suguiñequin? Au ez da vici izatea, baicican beti icaraz eriotzaren atzaparretan ibiltzea. Obe ditugu bota gueren buruac ibai batera, itò uretan, ta quendu betico larritasunac. Erabaqui zuten ala eguitea, ta joan cirán ibai bateco egui, edo ondora. Dacuste uste gabe, nola an arquitzen zan igueltegui bat, gucia icaraturic, banatu, ta bota cituzten beren buruac uretara. Orduan esan cioen beste lagunei Erbi batec. Ez guera bacarric gu beldurrean vici gueranac. Badira bai gu baño ere beldurtiagoac. Ona nola gu ecusi ta beste gabe igues eguin, ta bota dituzten buruac ibaira Iguel charrac. Ez degu ernegatu bear: etorrico aldira egun paquetsuagoac guretzat; gaitzac dituzte beren mugac, ta aldiac. Goacen bada lengo lecuetara, ta vici gaitean nola al egun

egun obeagoen zai. Ala eguin zuten.

Ipui onec arguitzen ditu Guizon, ta Andra ernegari, irritu, ta paque guchicoac, ta beren buru, ta vicitzaco atsecabeai gaitziritziric, eriotza billa dabiltzanac. Ez dirá egun guciac berdiñac; gaur lecu beetuan dagoana, egon diteque egun guchiren barruan, goraturic: ta negu gogorrac ecarri oi du udaberri ederra. Jarri gaitean Jangoicoaren escuetan.

*Aurpegui eman bear diogu gaitzari,*
*Beguiratuta etorrico dan onari.*

## IPUI XVIII.

### *Otsoa, ta Irudia.*

CEbillela Otsoa basoan, arquitu zuen Irudi, ichura uts, edo imajiña bat. Artu, ta egonzan goi ta be beguirá, ta dioe esan zuela. O cein ederra cerán! baña ez dezu cenzu, ez garuñic.

Ipui onec lotsatu bear ditu edertasun utsean biotza ipiniric daucatenac. Eder adingabeco, ta argui laburrecoa da cenzunic ez duen Irudi uts baten guisacoa.

*Edertasuna da egun laburrecoa:*
*Jaquituria vicitza guciracoa.*

IPUI

## IPUI XIX.

### *Eulia, eta Mandoa.*

MAndo batec ceramala Burdia jarricitzaion burtolean Euli gogaitgarria, ta diotsa: Mando zatar ta astuna, abill ariñago; bestela nere eztenarequin odoldu ta pizcortuco aut. Aserratu citzaion Mandoari Euli cital batec ain arro itz eguin bearraz. Eranzun cion bada: ¡ ó piztia cital, quiratstu, ta gogaitgarria ! Ecin gaitzic eguingo diat: ala ere, ez cidac ardura andiric ematen ire ezten chaarrac ateratzen bacidac odol apur bat. Nere gañean dijoan Mandazai onen zigorrac beldurrago eguiten naitziac. Onen cigorrada, ta ugal orapillotuac ematen diztan zartadac, atera oidizquite zambro andiac. Au bai dala beldurgarria.

Ípuiac eracasten dioe Andìquiai, badutela cer beldur izan nondic edo andic.

*Chiquiac dira noiz bait arrotzen:*
*Ta Andiac dute ernegatzen.*

## IPUI XX.

### *Eulia, ta Chindurria.*

Euliac, ta Chindurriac cerabilten auci gogor bat, nor otezan ederrago. Euliac bere alde edo bandoraco cioan: Zuc, Chindurri ichusia, ecin burua nerequin berdindu dezaquezu. Non nai, ta noiz nai gauza gucietan aurreratzen naitzatzu. Ardi, edo Idi bat iltzen badute, neu naiz lenengo jaten diodana nai dedana. Nabill Erreguén buru, ta maietan. Ló eguiteco dauzcat auquera osoan oeric biguñenac. Nai dedanean, eguraldi otzetan, noa sucaldera, ta an berotzen naiz. Eguzquitara irten nai badet, nore eragotzi? Ni nabill, edo lurrean oñéz, edo aidean egaa, nai dedan becela. Zu berriz beti arrastaca. ¡A izurri citala! diotsa Chindurriac: ¿Cer da ansi zu egotea Erreguen buru, ta maietan, ló eguitea oe biguñetan, berdin iñore ecusi nai ezbazaitu? bacera gucientzat gogaitgarria? Eguraldi biguñaquin bazabiltza bai egaa: cerbait badirudizu bero aldietan.; Negua datorrenean quiquil-

quiltzen cera, ez zoaz maico ogui apurrac biltzera: ezcutatzen cera toqui illunetan, ta iñorc ez du zure berriric, ez daqui vici ceran edo ez; ecin arpeguiric eman diozu elur apur bati: ¿ta au da zorionecoa izatea? Ni vici naiz udaan atseguin osoan, ta non nai det cer jan. Neguraco prestatzen naiz bear eguiñaz, nere bizcarrean daramadala ogui zorroa, edo gari ale neu baño astunagoa, ez zu becela alperreriara emanda negu gucian barau eguiten, cer jan ez dezula ceure bacartadean. Otzic andienetan, elurrác lur gucia estaldua gatic, daucat nere echea lurraren azpian bere gari guelarequin. Aiceri, Erbi, Zozo, Birigarro, ta ambeste Egazti goseac argalduric, otzac igaroric dabiltzanean, ni ez naiz ez otzaren, ez gosearen beldur. Guizon gueiac naucate bearguintzat, ta esan oi dute, icasi bear dala Chindurrietatic bearguiñ, ta contuzcoa izaten, ta prestatu bear dala cer jan bearric ecin dan egunetaraco.

Ipui onec eracasten digu, ez buru zaleguiac izaten, ez arrotzen guere gaucequin. Esana ta anciñacoa da, bacoitza vici duela bere zoroac.

 *Ba-*

*Bacoitzac bere burua goratzea*
*Da bere burua ondo ez ezagutzea.*

## IPUI XXI.

### *Otsoa, Aiceria, ta Chimua.*

Auci bat jaiquizan Otso, ta Aiceriaren artean. Otsoac egozten cion, arrapatu ciola berac jateco ceucan Bildotsa. Aiceriac ucatzen zuen. ¿ Norc erabaqui zucen errierta, edo ez da bai da au? Billatu zuten orretararaco Chimua; enzuncituen onec bataren, ta bestearen esan, ta aguiriac. Ez cecarten testigu, edo ecuslaric. Eseri zan bada Chimua aulquian, ta eman zuen epai, edo sentencia au. Bioc cerate lapur ezagunac; ta iñorc ez daqui nor dan guezurti, ta gaiztoena. Ez du Otsoac ecarri bere esanaren aguiri edo probanzaric; bere esan utsa ez da asco sinistua izateco, ta legue zucenetan ez zaio sinisteric ematen Lapur jaquiñari. Bestetic Aiceriac ucatuco zuen ostu balu ere. Ala, zaudete paquean, ta onembesterequin bucatu bidi auci au, bada bioc guelditzen cerate burua garbitu gabe, ta zaio gaiztoan.

Ipui

Ipui onec dio, guezurti, ta lapurrac ez dutela izan bear sinistuac. Gaiztaguintza, ta oquer quizunetan artua, dala gaiztaguiñ, ta oquertzat ezagutua. Guizon eguia zale ta bestetic zucenac gucia daucatela eguinda sinistuac izateco.

*Guizon gaizto, ta lapurra*
*Guci gucia guezurrá.*

## IPUI XXII.

*Guizona, ta Ogui-gaztaia.* (Mustela)

Ogui-gaztaiac eguiten ciozcan guizon bati calte andiac echean sartuta, itoaz Ollo ta Usoac, ta janaz arrautzac. Ipiñi cion laquio edo gatigugarri bat, ta erori zan bertan. Arquitu zuen guizonac atseguin osoz oñetic catigatua, ta diotsa. ¡O calteguiñ citala! Erori aiz gueroenean. Aspaldico egunetan ondo vici izan aiz nere Ollo ta Usoaquin. Eranzun cion buruz bera edo humilqui Ogui-gaztaiac. Nere jauna, ori eguia da; baña oroi bidi naizala saguzale, ta arrapatzallea; garbitu diodala echea piztia zital oetatic. Ni nabillen lecuan ez

da

da catu beàrric. Cembat on, ta mesede izan du nic itoaz ambeste sagu ta arratoi andi ? Aurreratu ditu guchienez anega bi gari, lau anega artoale, arroa erdi urdai, aitatu gabe sagar, castaña, gaztae, ta gozotan arrapatu, ta irentsi oi dituztenac. Contuac alcartzen baditugu, gaitz baño mesede gueiago eguin diot. Ez nagui bada banatu, ez arren ill. Ematen diot itza, ez diodala gueiago arrapatuco Ollo, ez Uso, ez arrautzaric, ta guelditsuco naizala berorren Echean Catu orde, ecer costagabe. Eranzun zion Guizonac; ederqui itzeguiten dec: letradu beàrric ez dec; baña baciaquiat, ez aizala ebilli nere ona gatic saguac arrapatzen, ta bai ere sabelaren asco naiz. Certaraco ciatubat vorondate on gabeco on artuac ? Norc sinistu ire itz labañ, ta berriquetai. Estuac erasoten dizquic; laster aztuco zaizquic, Olla toquian burua bacarric ecusten badec. Ala, ill bear dec; bestela betico beldurrean vicico dituc nere Ollo, ta Uso gueldit u diranac.

Ipui ederra gaiztaguiñai sinistea ez emateco. Estuac edocer erasotzen du. Vorondatea oná ez badago, biotz caltétua duena, las-

laster biurtuco da edocein gaizqui eguitera. Echeetan aci oi diran Aiceriac ez dioe ortzic egozten Olloai echecoen aurrean; baña ezcutuan bai.

*Calteguiñac beti caltea*
*Gaiztoa bada vorondatea.*

## ÍPUI XXIII.

### *Iguela, eta Idia.*

Iguelac ecusi zuen bein Ídi bat, gucia loditu, ta guicen guicen eguinda, cebillela Zelaico larrean; ta beguitandu citzaion bera ere aci ta guicendu citequeala Ídi ura becela bere azal, ta larru cimurra betetzen bazuen nola bait. Asi zan bada puztu, ta aicez arrotzen bere larrua, ta jarricitzaion buruan, aci zala asco, ta galdetu cioen bere umeai, Ídia beste ote zan? Eranzuten dioe ezetz guchiagoaz ere. Puztuago eguin zan berriz pussiga bat balitz becela. Puzca, ta indarca cebillela, orra non eztanda, edo ler eguin zuen larrua etenda.

Ípui onec eracusten digu, ez degula arrotu

rotu bear andiago, ederrago, ta aberatsago izan naiz.

*Aicez guizendua*
*Laster da galdua.*
*Igoten duenac góregui*
*Jó bearco du beregui.*

## IPUI XXIV.

### *Leoya, ta Arzaia.*

Leoytzar izugarri bat cebillela basoan larren artean, sartu citzaion aurreco oin azpi batean arantzea, ta anditu agitz, errenca, ta miñ andiequin baño ebilli ecin zala. Arquitu zuen Arzaia, ta nai cion oni adierazo, non miñ zuen; escatzen cion laguntasuna oiñ arantzatua esqueñiric. Icusi zuenean Arzaiac bereganonz cetorrela Leoya, sartu citzaion icara larria, ta gaitzic ez izatearren, esqueñi cion ardi bat. Ordea Leoyac ez zuen ordu artan ardi goseric, ta bacarric billatzen zuen osasuna, ta arantza ura ateratzea, ta orretaraco eraman ziozcan Arzaiari bularrera bere beso biac, ta eracutsi cion oiñ mimberatu,

ta

ta aranzatua. Bereala igarri cion Arzaiac, cer nai zuen Leoyac; ta beldur gucia joanic, artu cion beso gaissotua; aztertu cituen oiñ azpico bazterrac, ta arquituric arantza sartua, atera cion poliqui, ta guero garbitu ere ciozcan barruan andituarequin eguin ciran ur ustelac. Ecusi zanean Leoya ala sendatuta, esquerrac eman nairic itz gabe, millizcatu cion Arzaiari escu gañea, ta aldi batean egon zan bere aldamenean.

Egunac igarota arrapatu zuten Leoya Guizon batzuec, ta eraman zuten lotuta Erri andi batera presondegui caiolatu baten gordetzeco, ta ateratzeco Plaza edo toqui aguiri, ta langatu batera, Cecenac atera oi diran bezela, botatzeco jan garritzat Guizon Gaiztaguiñac. Iñore ez daqui cergatic, baña artu zuen Justiciac aitatu degun Arzaia; ta Aguintariac erabaquizuten, bota bear zala Cuizon ura Leoyac irentsi cezaten. Arzai gaissoa eraman zuten Plazara; atera cioen Leoytzarra, Cecen bat oi dan becela; ecusi zueneco Guizon bacarra, oñac ariñic abiatzen da, sua ceriola, arrapatzeco Arzaia; baña orra

non

non besoac egozteco unean ezagutzen duen Leoyac, Guizon ura zala bere Onguillea; berari arantzea atera, ta osasuna emanciona. Atzeratu cituen besó, apurzeco jasoac; jarri zan Leoya beguira barrera gañetan ceuden gendeai, ta Arzaiari gaitzic eguin gabe, biurtu zan bere Cortara, quiñuequin adierazo cion Leoyzaiari, cijoala andic bere cereguiñetara. Biurtu zan berriz Plazara pozcaria aguertzen zuela; jarri citzaion Arzaiari aldamenean, ta cegoan an bere zai ta Gordetzalle eguinda. Icaratu zan gende gucia cecusanaz. Aguindu cioen Arzaiari irtetzeco Plazatic; joateco nai zuen locura. Abiatu zan irtetzeco; jarraitzen cion Leoyac nora nai Chacurcho batec bezela. Jaquin zutenean Arzaia-gandic cer guertatu citzaion basoan Leoy arequin, ta cergatic guero gaitz eguin ez ecen, eracusten ere ciozcan amórioaren señale, edo igargarriac, ascatu cituzten Leoya, ta Arzaia; Leoya joan zan bere basora, ta Arzaia bere ardizaitzera.

Ipui onec eracusten du, izan bear degula esquertsuac guere onguillaquin, ta me-

mesedeac gueitu bear dizquioguezala, mesedeac eguin dizquigüenai. Esquergabetasuna dala gaitziritzia beti, ta guciac gorrotóz beguiratu oi dioena.

*Mesedeac dituzu artu?*
*Ez zaiteala iñoiz aztú.*

## IPUI XXV.

### *Zaldia, ta Leoya.*

LEoytzar batec ecusiric zaldi mardo, ta guizen bat cebillela celaian belarra jaten, etorri citzaion gogo edo asmoa arrapatzeco. Urreratu citzaion, ta asco nai balio becela, edo adisquedearen estaliz, diotsa. Ni naiz Sendaguille edo Medicu chit aditua. Igarri cion Zaldiac, cebillela guezurrez, ta asmo gaiztoz; baña ala ere eguin cion arrera ona, igarri ez balio bezela, ta adierazo cion poztutzen zala iduquitzeaz alaco Medicu bat bear orduetaraco. Zaldia asi zan errenca gaiztoz, oin batean arantzea sarturic ceducala siniserazotzeco Leoyari, ta esaten dio. O Leoy ona! eta ceimbat gozatzen naizan nere atsecabearen erdian zu becelaco Senda-

daguille bat bear ordu onetan emen aguertzeaz! Atera bear didazu atzeco oin batean sarturic daducadan arantza oñazatzen nauena. Leoy tontotzarrac ezagutu gabe Zaldiaren gogoa, diotsa, damu det orrembeste miñequin zu egotea; ez larritu; neronec ateraco dizut arantza oñazagarri ori; nic largaco zaitut miñ gabe ta guziz sendaturic. Bata ta bestea cebiltzan, norc nori guezur caltegarria sartu. Ecarzu bada, diotsa Leoyac, gaiso dezun oiñ ori. Ori esatendio Zaldiac, ta oña jasoric, jotzen du becoquiaren erdian osticada gogor ta ondo zucendu batequin; ezarten du lurrera, largatzen du Leoytzarra conorte gabe, ta artzen du Zaldiac iguesa. Bereganatu zanean Leoya arpegui ongui mallatuaz, ez zuen aurrean ecusi Zaldiric. Odola ceriola, ta aguitz miñ, dio, Ai ai! Nerea da obena edo culpa. Ondo guertatu zait. Uste nuen jaquitunagoa nintzala Zaldia baño; guezurra nerabillen ezpañetan, ta asmo gaiztoa biotzean. Larga banio gueldi Zaldiari, bere bearrac gueldi iduquico zuen. Arc ez zuen aranzaric oñetan, nic bai bere osticada galanta becoquian.

quian. ¿ Cere sartu nenduen ez niaquian bear guintzan ? Nere burua sendatu ecindet, ta siniserazo nai nuen, Sendaguille eder bat nintzala. Guezurraren irabacia !

Ípui onec esan naidu, ez degula iñoiz sartu bear ez daquigun, ta ez dagoquigun lanean. Íñori calte eguiten dionac, eracarrico dúela caltea bere burura.

*Ipiñi diozu iñori locarria ?*
*Izango cera bertan eroria.*

## IPUI XXVI.

### *Zaldia, ta Astoa.*

Zaldi eder bat, gucia apaindua, catea cillarrezcoz, jarlecu, ugal, ta anca estalquiz urrez bichitua ; Jabe aberatsa ceducana, cijoala videan arro arroric, idoro zuen Asto macal, argal, pisuaren pisuz macurtu ta obendua, ta atzetic maquillada gogorrac ematen ciozcana Astazai erruqui gabeac. Ecusiric Zaldiac, ez ciola beingoan alderic eguin videtic, ecin cezaquealaco necatuaren necatuz, esan omen cion Astoari. Arrituta naitziagoc, Asto zatara,

rra, nola osticadaz asetzen ez aidan. ¿Cergatic baztertu ez, ni icusita? ¿Cergatic egon ez aiz gueldi bazter batean ni igaro artean? ¿Nor naizala uste dec? Nago ni ain apaindua, cillar ta urrez pichitua. Nere Corta edo Egontoquia garbiago ciagoc ascoren echeetaco guela, ta Lotegiac baño. Nere Echeco Nagusiac eguiten diezte aguiraca gogorrac Morroiai egunoro garbitzen ez badute nere egonlecua; Ascaan autsic ez du arquitu bear, ez da garagarrian ere. Garbitzen dizquide oñac; leundu bear dituzte nere bizcarra, ta anquea: nere illeac argui eguin beardu. Beguira bada, cein mardo, guizen, ta mamitsua nagoan. I berriz, zatar ori, burutic oñetara ago, edo autsez josia, edo basatua: aguiri dituc bizcar-ezurrac; jostortz edo eztena cirudiec ire berna zancogabeac: burua jaso ecindec; belarri macaldu ta zaurituac aguiri dituc; videan nequea, ta echean gosea. Onelacoa izanic, ez didac lotsa gueiago gordeco? Lenengoa gatic, barcátzen diat; baña beguirá beste bein onelacoric guerta ez didin. Icaraturic Astoa aitu cituenequin Zaldi arro-
aren

aren aotic, cijoan aurrera erneguz ta biraoça, madaricatzen zuela sortu zan orduа. Andican urte batzuetara izan zuen Astoac Jabe obe bat, ceñec ematen cion ondocho jaten, ta ez bear gogorreguiric eraguiten. Mardotu, ta ille edertu zan gure Astoa. Baña bestera guertatu citzaion Zadi arroari. Urteac igaroric, salducion bere Jabeac Errotari chatar bati, ceñec eraguiten cion bearra chit aguitz, ta eman jateco guchi, ta maquillada asco. Onela bere mardotasuna deseguin zan, aguertu citzaizcon bizcar ezurrac, zorroztu anca len guicena, laztu illea, zauritu bizcarra, macaldu burua, ta eciñ iñore esan cezaquean lengoa zala. Zegoala Asto urasse berá Ibar batean belarra jaten pizcorturic, dacus, ta ezagutzen du lengo Zaldi bere aguiracari arroa, trallatic ceramala Errotarí charrac, gucia argaldua, aguinte ta indar gabea, bizcarrean zituela zorro andi bi, buruz bera, basta zatar, ta ugal erdi etenequin, guerriraño locaitzatua, ta diotsa Astoac burla eguin bearrez. O Zaldi Jauna! Eta cein aberatsa cerán! Nora ditu berorren an-

anciñaco cillar ta urrea ceriozquien apainduriac? ¿Nora da araco buru arro ta gallendua? Nonda orduco mardotasuna? ¿Nora igues eguin dute berorren mami galantac? Etorquizunai beguiratu gabe, zu izan ciñan bai, ta ez besteric, escatu cinidana baztertzea, ta gueldi egotea, igaro bear cenduan videa iduquitzeco ceretzat bacarric. Zu, nequepean ni icusita, erruquitzen ez ciñana. Goiac beratu dira. Orain nago ni Jabe onarequin zaartza on batean, belarra emen jaten, guciáu pizcortuta, ondocho jan ta, bear neurri onecoan vicitza daramadala. Ez zaude zu orretara oituric.

Ipui onec eracasten dioe aberats, ta andiquiai, ez abegor charric eguitea, ez itz gogorric esatea nequean vici diranai, beragoçoai; ta izan ditecela erruquior ta biotz biguñen jabeac premian daudenentzat. Ez dala arrotubear Andilecuetan; goicoac iruli oi diralaco becoetara. Biotz bera ta arrotasun gabeac iraungo dute beren goratasunean. Baña

*Zapaltzen duenac beetua,*
*Artuco du bere lecua.*

# ÍPUI XXVII.

## *Lurreco Abere, ta Goietaco Egaztiac.*

Jaiqui zan errierta, ta auci odolezco bat lurrean dabiltzan lau oñeco, ta goietan egoz dabiltzanen artean. Ez batzuec ez besteac atzeratu nai ciran aserrean egotetic. Icusiric Saguzarrac lurrecoac garaituco cituztela goietaco Egaztiac, andiagoac, ta indartsuagoac ciruditelaco, alde eguin zuen Egaztien aldetic, igarotzeco lau oñecoen bando, edo aldera. Egunac etorri ta joan cebilzala, prestatu ciran beste batalla, edo auzca gogorragoraco; bada lenengo erriertan batzuec, ta besteac guelditu ciraden igarri ecinic nor izan zan gogor ta garaitiago. Etorri citzaien Egaztien bigarren errierta odoltsuraco, len berequin iduqui ez zuten Arranoa. Oec bildu, ta alcarturic, jetsi ciran lurreronz equiteco gogorqui Leoy, Cecen, Otso, Basaurde, Catamotz, ta chiquietaricoai ere bai. ¡ Cein ecusteco ederra ! Goian ambeste Egazti atzapardun, bean lau oñeco izugarri beldurra

sartu bear zutenac. Arrano pillo batec beren egotzarren otsarequin sartzen cioen izua beecoai. Cetocen guero beste Egaztiac, ta beren moco ta atzaparraquin zauritzen cituzten. Lurrecoac equin naia gatic, colpeac emanda, beren egoequin alde eguiten zuten; bacetocen berriz lau oñeco igues eguin zutenetara, ta oen arteco batzuei ateratzen ciezten beguiac; beste batzuec largatzen cituzten errenca, mancatuta, ta ez guchi guciz illda. Cebillen lurrean Cecen, Otso ta lau oñeco ascoren odola. An zan enzutea Zacurren inciriac, Zaldien irrintzac, Leoy ta Cecenen orroac, Basaurden urrumizac, Aicerien illetac, Catamotzen miao izugarriac. Ecusi ciradenean lurrecoac garaituric, ta ambeste lagun galdu zutela, escatu cioen paquea Egaztiai. Oec etorri ciraden orretara; baña escatu cituzten bi gauza; bata guerra artan illic gueldìtu ciran lau oñecoac gueldìtu bearco zutela beren janaritzat; ta bigarrena, saguzar saltzalleari bérac eman bear ciotela erabaqui, edo sentencia. Eguin zuten orretaraco Egaztiac Batzarra, ta aguindu zan, quentzea Sagu-
zar

zarrari cituen lumac; billostu edo larru gorritu bear zala; ez ceguitela Saguzarrac iñoiz arguitara irten. Ala oi dabiltza ecertaraco gauza ez dirala, ta iñorc ecusi nai ezdituela.

Ipui onec dio

*Bere odoleco, ta adisquiden Saltzallea*
*Dala bere buru galtzallea.*

## IPUI XXVIII.

### *Aizeria, ta Otsoa.*

Otsoac eizan cebillela, bete zuen bere lur uspe, edo leicea ariquiz, erbiquiz, ta aunzquiz, ta baceducan cer jan egun ascotan. Usaira urreratu citzaion Aizeria leiza aurrera, ta campotic, edo sarreratic diotsa Otsoari. Nere Jaun prestua, egun asco da alcar ecusi ez degula. Argatic natorquizu gaur eguitera ecustamen edo visitacho bat. Bestetic nere sabeleco utstasunac, egun ascotaco jan ezac, naduca aguinte gabe. Uste det erruquituco cerala nizaz. Badezu or cer eman zure calte ezagutu gabe. Igarri cion Otsoac cer

cerabillen Aizeriac, ta diotsa barrunbetic, Asco jaquin gaiztoa, guciac ezagutzen aute. Quen adi ortic. Ez ator i nere onez. Atera nai nauc emendic, guero arrapatzeco issillic nere janariac. Billa ezac alper cital orrec. ¿ Nai dec iñoren maian jarri, galanqui bazcaldu, ta bearric eguin ez ? Aiceriac irten zuen buruz bera, ta erneguz; ta, dio, Otso cequen ta prestueza, gogoango didaç piri, cer jan ematea, ucatua. Joan zan basoan ardiac zaitzen cegoan mutill bategana, ta esaten dio: Arzaia, ce sari edo aloguer emango didazu, aguertzen badizut non dagoan ezcutaturic Otso zure etsai andia ? Arrapatu edo illco dezu chit erraz. Diotsa Mutillac Aiceriari; sarí onac emango dizquitzut ori eguiten badezu. Atoz bada nerequin, esan cion Aiceriac, ta eraman zuen Otsoaren leizara. Sartu cion Arzaiac Burni zorrotz bat saietsen artean, ta larga zuen illic. Icusi zuenean Aiceriac illic Otsoa, diotsa Arzaiari: ez det orain zure alogueric bear. Sartu zan leizan, ta Otso illaren aldamenean ase zan ariquiz, ta ardiquiz, ta igaro cituen egún asco bazçari, ta apari ederrac

rac eguiten. Otsoaren ondasunac ez ciran betico. Aiceriac irten zuen Ollo billa, ta erori zan ipiñi cioten laquio edo trampa batean. Catigu cegoala, gogoratu citzaion Otsoarequin eguin zuena, ta esaten zuen. Gaitz eguin nion Otsoari, ta argatic datorquit neroni ere eriotzaco videa.

Ipui onec eracasten dioe guizonai, ez iñoiz pocic artzeco iñoren gaitzaz: guteretzat nai deguna, nai izan bear dioguela besteai: ez degula damuric artu bear lagunaren ondo izateaz. Gorroto izan bear diogula cequentasunari, ceñec ecarri cion Otsoari bere galtzapena.

*Ez eguin iñori calteric*
*Ez artaraco eman videric.*
*Guizon prestu, ta escu zabalecoa*
*Izango da gucien gogocoa.*

## IPUI XXIX.

### *Basauntza, ta Eizaria.*

Iturri batean edaten cegoala Basauntza, ecusi zuen urean bere adarraren queriza. Asi zan arrotasunez esaten ¿ Nor ni be-

bezein ederric ? ¿ Norc iduqui buruan nic daucadan becelaco apaingarriric ? Beguiratu zan guero oñetara, ta ecusi cituenean berna ain me, argal ta mamigabeac, erori citzaizcon biotzeco egoac. Onela cegoala chit larri, enzun cituen Chacur zaucac, ta burua goraturic, dacus Eizari bat cetorrela Chacurren ondoren. Baña nola oñac cituen chit ariñac, igues eguin cioeñ erraz, ta sartu zan Baso characatu batera. Emen zan estua. Catigatu citzaion bere adarra characaco otatza, ta larretan, ta eguin alac eguinda, ecin ascatu zuen, ta guelditu zan gatigu. Chacurrac jarraitzen cioten bere oñatzetatic, ta Eizariac ere bai Chacurrai. Ecusi zanean eriotzaco ortzetan, esan omen zuen: Ai ai ! adar au da nere galgarria: bestela nere oñaquin erraz gordeco nuque burua. Nic uste nuen mesede andi bat neduçala adar apaingarri onetan, ta madaricatzen nituen nere oiñ me ta argalac. Orain ezagutzen det nere caltean, oñac ditudala nere gordegarriac, ta adarra nere galgarria. Onetan cegoala, eldu ciran Chaçurrac, ta Eizaria, ta arrapatu zuten.

Ipui

Ipui onec eracasten du; ez dutela guizonac aldi ascotan ezagutzen cer dan ona ta cer charra berentzat. Ontzat dauzcatenac, izan oi dirala calte garrienac. Edertasun, ta apaingarriac iduqui oi dira ontzat; ta ascorentzat, Basauntzarentzat becela, izan oi dira caltegarriac. Aberatsac uste du dala zorionecoa diru ascoren jabe dalaco. Baña lapurrac billatu dituzte sarri beren echeetan eriotza emanaz, ta necazariaren echean ez dute oñic ipiñico.

*Ichura pen utsaz ez zaiteala arrotu*
*Oquerra zucentzat ez daguizun artu.*

## IPUI XXX.

### *Aiceria, Ollarra, ta Chacurrac.*

Goseac estutzen zuen aldi baten, eldu zan Aiceria burua lurraren contra cerabillela Ollarrarequin Olloac cebiltzan toqui batera. Ollarrac igarri cion Aiceriaren etorrerari; asi zan carcarasa estueqnin Olloac biltzen, ta igoerazo cioen guciai arbola gañera bera aurrerengo zala. Aiceria jarri zan arbolapean, ta esaten dio pala-

palaguz, ta itz labañaquin Ollarrari. ¿ Cer eguiten dezu goi orietan zure Olloaquin ? ¿ Noren beldur cera ? ¿ Nere ? Ez nator ni zuen billa, zuei gaitz eguiteco, ta bai lurreco berriac zuei emateco. Ez daquit nic eceren berriric, diotsa Ollarrac arbola gañetic. Eguin da bada, esan cion Aiceriac, lurreco lau-oñeco, ta egazti gucien artean betico paquea. Emendican aurrera ecin alcarri gaitzic eguingo diogu. Jetsi zaite bada beera ceure lagun oriequin, ta paquearen icenean eguingo degu alcarrequin bazcari eder bat. Benaz Benaz, diotsa Ollaarac, poz andi bat ematen didazu berri orrequin; ta au esanda, jaso zuen burua ta luzatu iduna cerbait balecus becela. ¿ Cer dacutsu ? esaten dio Aiceriac. Dacustaz, diotsa, Chacur bi datocela arinca ta saucaz, ta etorrico dira paquearen berri onac guri, ta zuri ecartzera. Ala bada, Chacurrequin, emendic jetsita, eguingo degu gucioc bazcari zuc diozuna. Agur, agur, esaten dio Aiceriac, banoa ni emendic. Ollarrac arbolatic, eroa, nora zoaz ? ¿ Ceren beldur zera paqueac eguin badira ? Chacurrac ere ecin gaitzic
eguin-

eguingo dizute. Ori ala da, dio Aiceriac, baña guerta liteque datocen Chacurrac baque berriric ez jaquitea. Onequin igues eguin zuen Chacurren zai egon gabe.

Ipui onec dio, asco jaquiñentzat badirala asco jaquiñagoac; guezur batec aguertzen duela beste guezur bat.

*Ez bada iñori guezurric sartu,*
*Guezurra ez daquizun aguertu.*

## IPUI XXXI.

### *Aita, ta Seme gaiztoa.*

Guraso batec ceucan Seme oquer ta gaizqui aci bat ceñec ematen ciozcan naigabe andiac, ta negar eraguin oi cion chit sarri. Aldi ascotan gueldirzen zan gabaz campoan. Eguiten bacion aguiraca, largatzen zuen gogorragoac eranzunda, ta ecin bururic eguin zuen berarequin. Seme gaizto onegatic morroi ta mirabeac ere eraman oi cituzten atsecabe asco. Oei esan cioen Echeco Jaunac Ipui au. Necazari batec zeucan Idisco gazte, mardo, ta eci gabea. Eci cidin, uztartu

zuen Idi ecandu batequin. Cecusanean Idiscoac lepoa uztarpean gatigu, ta ecin jaso zuela burua nai becela, indarca ta osticoca mancatzen zuen Idi uztarrian gueldi cegoana. Necazari, bien jabeac acullua arturic, ematen ciozcan galantac Idisco uzu ta eci gabeari, ciotsala; ez zaitut nic uztartu burdia erabilli, ta soroan lurra aratzeco, ta bai bacarric ecitzeco zure lepo gogorra. Onela gueldica aculluaren videz eci zuen, ta guero uztarria eracutsita beste gabe, etorri oi zan Idiscochoa burua macurtzera.

Ipui onec esan naidu, gaztetatic uztartu, edo eci bear dirala umeac lepo biguña daucaten artean. Ecarri bear dirala onez, ta gaitzez esanac eguitera, gurasoai lotsa gord tzera, echeari beguiratzera. Au ez eguiña gatic mugonez, ta gaztechotan, lepoa gogortzen dala, ta guerora ecin ecarri dirala escura; gogortzen dirala gurasoen contra; irtetzen dutela lotsa galducoac, vicitza charrecoac, ta atsacabe asco emateco. Au ezagutu zuen, baña berandu len aitatu degun Aitac.

*Dara-*

*Daramana gaztetatic uztarria*
*Izango da ume ondo acia.*
*Guelditzen bazaio idun gogorra,*
*Berandu etorrico da zigorra.*

## IPUI XXXII.
### *Escua, Oñac, ta Sabela.*

Escuac, ta oñac alcar arturic equin cioen sabelari, esanaz: Ó lagun gaiztoa! Gure bear ta nequeaquin daramazquitzu egun gozatsuac: asetzen cera jan ta edanaz gure irabaciac. Oñacquin goaz sorora; escu ta oñacquin laiatzen da; mastiac ardoric emango badute, ecin dute escuen neque andi gabe. Aldi ascotan beso guztiac aricatu beardute. ¿ Cembat bider oñez vide luceac eguin bear dira cerbait irabazteco? Zuc, ó sabel gaiztoa! daramazquitzu cere barrumbera gure neque, ta icerdi gucien irabaciac, oguia, ardoa, ta cer ez? ¿ Eta asetzen ote cera beti gure irabaci al guciaquin? Guretzat ez dago nequea baicic. Ez degu ecer jaten. Ala bada icasi bear dezu bearguintzaren bat cer jan izaiteco: erabaqui degu guc, ez bear-ric-

ric eguitea zuretzat. Eranzun cioen sabelac; ez arren orrelaco asmo charric artu. ¿ Ez daquizute nic ecin ecer irabaci dezaquedala ? ¿ Ce bearguitza icasico det ? Asco zor dizuet, eguia da: eguiten dezute bearra neretzat; ordea zuec partil izan oi cerate. Nere barrumbera datorrena, ez da gucia bertan guelditzen, neretzat bear dedana gorde, alper dana bota, ta zuec gana igarotzen da vici ta sendacaia. Nic jaten ez badet, ¿ nola zuec vici ? ¿ Nola bear eguin ? Alcarri bear diogu lagundu; bada eche batecoac guera. Diotsate escuac ta oñac; asco jaquiña, asmatzalle, ta berrichua cera guri zoraerazotzeco. Guezurra diozu ez guera gu zure bear, ta ez dizugu lagunduco. Larga zuten sabela egun batzuetan janic, ta edanic eman gabe; ill citzaion barruco berotasuna, leortu ta ugartu miñgaña egarriz. Sabelaren jan ezaz argaldu, ta indar gabetu ciran escu ta oñac. Ezagutu zuten oec nondic cetorquen calte ura. Ematen dioe jaten ta edaten sabelari; baña berandu cetorren sendagarria: ill zan sabela ta ill ere ciran escu ta oñac.

Ipui

Ipui onec esan naidu, ez dala bacoitza gucia beretzat, edocein guizonec bear dituela lagungarriac senide, adisquide, ta onguillen artean. Erregue bat ere ez dala izango Erregue, bere mendecoac laguntzen ezpadioe. Eche, soro, ta baso asco dauzcan andiquiric aberatsenac, burua galdu ez badu, aitortuco du, alperrac dirala alaco ondasunac necatzen ezpada bearguiña; ez duela ez errenta, ez gari, ta ez icatzic izango necazariaren escubear gabe. Escuac, oñac ta sabelac alcarri lagundu bear dioen becela, ala guizon batzuec besteai, galduco ez badira. Ezaguera onec ecarrico gaitu alcar maite izatera, beragocoai ez eracustera gogortasunic. Baleducate au gogoan Nagusi, ta Echejaunac, oniritzi, ta maitetasun gueiago ecusico litzaque beren serbitzari, ta Errenteroen alderonz, ceintzuen neque, ta beareguiñez dauden ambeste era ta Jauntasunean. Orregatic.

*Bat beretzat ez da asco:*
*Laguntasuna du bearco.*

## IPUI XXXIII.

### *Guizona, eta Astoa.*

Guizon batec cerbait irabaci nairic, ezarri ciozcan bere Astoari bizcarrera perz, edo lapicoz betericaco otarra bi, ta nai cion ariñ eraguin ambat lasterren eldutzeco Feria andi bat cegoan Errira. Asto gaissoari ematen ziozcan maquillada gogorrac, al zuen baño ariñago eraguiteco. Baña güeroago, ta laburragoa zan Astoaren ebillera edo pausoa. Guichi jan, pisu andia, maquilladac ugari, larga zuten aguinte, edo adore gabe. Onela estutu zan, ta esan omen zuen buru-andicoac, Ai illic banengo! edolaric bucatuco liraque nere nai gabeac. Alaco batean errori zan illic, ta erorteaz ausi ciraden perz, edo lapico asco. Astojabea asi zan biraoca, ta colpetzen Abere illic cegoana. Ecusiric ambeste calte, Astoa illda, ta lurrezco onciac apurtuta, cer eguingo det? dio: quenduco diot larrua Astoari; eguingo ditut arrazcoac: necatu zan orretaraco mia-

miatzen ta moldatzen larrua. Guizonac izan zituen calteac, ta Astoac illda ere larrua eman bearra; arc, bere cequentasun, ta erruquiric ezaz, onec eriotzari biraoz dei eguin ciolaco.

Ipui onec eracasten dioe batzuei, ez gueiegui irabaci nai izatea; ez, mendeco ta morroi mirabeai neque larregui, edo gogorreguiac artuerazotzea; ta beste batzuei, ez dei eguitea eriotzari erneguz. Eriotza charrarequin ez dira bucatzen atsecabe guciac. Christau batec beguiratu bear dio beldur onez eriotzari. Etorquizunac eracarri bear gaitu ez ernegatzera atsacaben artean, ta artzera paquez lurreco nai ez, ta pena garriac.

*Eriotzari erneguz deitzea,*
*Ez da naigabea quentzea.*
*Gabiltza gueieguiaren billa?*
*Izango guera guere calteguilla.*

## IPUI XXXIV.

### *Aiceria, ta Matsac.*

Eldu zan Aiceria mats-landara aci bat orman ichatsita cegoan Eche baten on-

ondora. Ecusi cituenean mordo ederqui elduac, etorri citzaion jateco gogo vicia. Abiatu zan alde gucietatic aztertzen, nondican igo al zezaquean mordoac ceuden toquiraño. Ez zuen igovide onic arquitu. Dio, igoco det landaratic: ordea, nola matsaren adarcho, ta aienac ciran argal, indar, edo sendotasun gabeac, cerbait igo zuenean, erori zan lurrera. Ernegatu bear zuen mordo ederrac ecusi, ta ecin arrapatuaz. Aitortu nai ez zuen bere ecin artua, ta dio estalgarritzat; mordo oec ez dira oraindican ondo eldu, gaitz eguingo liquet jango banitu, ta ala obe det ez jatea.

Ipui onec adierazotzen du, zurtasun, ta asco jaquiña izatea dala, noiz bait ez daquigulacoa eguitea. Orregatican.

*Ondo da noiz bait nai eza eracustea,*
*Ta jaquinda, ez jaquiñarena eguitea.*

## IPUI XXXV.

*Ogui-gaztaia, ta Sagua.* (Mustela)

Ogui-gaztaia zar batec ecin artu cituen Saguac oñac astunac ceuzcalaco, ta asma-

asmatu zuen sartzea iriña cegoan Arrazco batean, ta irten zuen zuriz janciric. Jarri zan toqui illunean, bestela ecinda, asmo gaiztóz saguac arrapatzeco. Eldu zan toqui artará sagu gaitz gabeco bat, ta beguitanduric, gauza zuria ecusita, janariren bat zala, erori zan bere etsaiaren atzaparretan. Ala eldu ziran beste sagucho bi, ta guertatu citzaien beste ambeste. Eldu zan Arratoi zar, asco jaquiñ, ta beti cebillena ondo bazter ta gauzai beguiratzen, erori ez cidin laquioren batean. Zuritasuna ecusita ez zan ero eroric iru saguchoac becela gueiegui urreratu. Igarri cion irin utsa ez zala: bacebillela gauza viciren bat, illaren ichurapean. Diotsa: O sagu arrapatzalle arnasea ito nai dezuna, ta soñoco zuriz estaliric zaudena! Asmo oriec on ta egoquiac dira sagu gazte, ta guchi jaquiñac arrapatzeco uste uste gabean; ez ordea ni becelaco soldadu zar, zure ta zu becelacoen asmoac ondo icasiric dauzquenac atzaparretara eramateco. Ascotacoa eguin bazaituzte ceure urte ascoac, bai ni ere jaquiteco non cer dagoan.

Ipui onec dio, indarric ez duten ascoc



beren

beren buruac gordetzeco, badituztela zurtasun, ta arguia, deseguiteco etsaien sendotasun, eta asmoac.

*Belar artean dago Suguea,*
*Ez bada izan arduragabea.*

## IPUI XXXVI.

### *Itzaia, ta Otsoa.*

Guizon bat cebillen basoco larrean Idiac zaitzen, ta urbildu citzaion itoca Otsoa. Diotsa arc oni: O Otso salobrea! Cerc zacarzqui ona ain estu ta larri? ¿ Ez dacutsu, eranzuten, dio Otsoac, nola datorren Eizaria nere billa? Ez arren ni salatu, ez esan cein vide artu dedan. Zoaz beldur gabe, diotsa Izaiac: ez diot chist bat ateraco, ta eracutsico diot oquerreco bidea. Andican laster eldu zan Eizaria, ta galdetu cion Itzaiari, nora zan Otsoa, cein vide artu zuen. Au cegoan urchoan sasipe batean ezcutaturic, ta icaraz. Itzai asco jaquiñac escuz ta aoz eracusten dio vide oquerrecoa; baña beguien quiñuz zucen, ta Otsoa cegoana. Eizariac ez cioen igarri beguien quiñuai, ta

escu

escu ta aoz eracutsi cion videari jarraitu, ta oquertu zan. Irten zuen sasipetic Otsoac, ta diotsa, oni Itzaiác, esquer andiac eman bear dizquidatzu gorde zaitudalaco: itzecoa izan naiz. Bai, eranzun cion Otsoac, esquerarc zure ezpañai, ta zure escuai: baña madaricatua izan didilla zure begui gaizto quiñularia.

Ipui ederra itz labañ ta samurrequin biotz dollor ta tolesturaz betea dutenentzat, ta ezagu eracitzeco cembat calte eguin dezaqueten. Auan bat, biotzean beste bat, da guizon malmutz, ta oquerren natua. Argatic.

*Ascoc dituzte itz eztitsuac,*
*Ta biotzez, asmo beazunduac.*

*Malmutza*, taimado: *natua*, genio.

## IPUI XXXVII.

### *Otsoa, ta Achurlaria.*

Otso bat erori zan laquio batean, ta ecusi zuten gatigu cegoala Achurlari batzuec. Urbildu citzaizcon, ta an zan ecustea, bazuec agacadac ematen, beste ba-

tzuec ista ta farra eguiten. Esan cioen beren arteco batec: Guizonac, ¿certaco da gaitz eguitea gaitzic eguiten ez duenari? Atzeratu cituzten agá edo maquillac, ta larga cioen gaitz eguiteari; erruquitu cirán oguia jateco ematerano. Gava eldu zanean, joan zan bacoitza bere echera, uste izanic, illco zala Otsoa goiceraco. Gau artan urratu cituen locarriac, igues eguin zuen, ta laster sendatu zan. Gogoan cerabillen, nola gaitz eguin berác ere bere gaizquillai. Biurtu zan basotic soro ta landetara, ta aserrezco sua ceriola, equin cioen arrapatu cituen Arzai ta Achurlariai. Larga cituen batzuec illic, beste batzuec gaizqui zaurituric. Sartu citzaien beldurra inguru artaco errietacoai, ta erregutu cioen gaitzic ez eguitea. Ondo da, dio Otsoac; barcatuco dioet jó baño eguin ez nautenai; iduquico ditut adisquidetzat nerequin erruquitu, ta oguia eman cidatenac; baña gogoango didate vicitza quendu nairic ebilli ciranac.

Ipui onec eracasten digu, biotz biguñeco, ta erruquiorra izaten: Bada

*Edoceñi on eguiozu*
*Noiz bait damuco ez dezu.*

## IPUI XXXVIII.

### *Aragui-epallea, ta Ariá.*

Ari asco cebiltzan larrean alcarrequin aldra, edo tegui bat eguinda. Etorri citzaien oquelasalzalle, edo errico Aragui-epallea, ta eraman zuen Ari bat. Bere lagunac egon ciran gueldi, chistic ere atera gabe, asco ezpalitza becela ambesteren artetic bat eramatea. Ala bein banaan, eguneoro eramaten zuela bat bacarra, guelditu zan lagun gabe Ari galant ta mardo bat. Etorri zan onén atzean ere, ta escuac egozteco unean diotsa Ari onec: O gure etsai odolguiroa! Eraman dituzu nere lagunac; ezcutatu dezu tegui gucia gueldica gañibet gogorraren videz vicitza quentzeco. Nerequin zoaz beste ambeste eguitera. Gurea da eraqueria. Alcar ondo artu baguendu, lenengo etorreran gucioc topeca equin baguinizu, gordeco guiñan eriotzatic. Choroac izan guera alcarri ez laguntzeaz. Orain bacarric arrapatzen nauzu, ta ez naiz asco zuri arpegui emateco.

Ipui ederra icasteco, nola alcar ondo artu

artu bear duten erri, naiz eche batecoac. Ari mé bat erraz etetzen da: ez alcarrequin soca lodi bat eguiten bada. Au ondó aituco balitza, banatuco ezpalira gure vorondateac, ez liraque ecusico ambeste errierta, ecin icusi, ta auci: Bada

*Arriscuari aurréz beguiac ezarri*
*Calte andiac ez ditecen etorri.*

## IPUI XXXIX.

### *Chori-artzallea, ta Choriac.*

Udaco egunetan ceudela Choriac querizpean alzutena jaten, ecusi zuten begui gaiztoco Chori-artzalle bat, nola prestatzen cebillen cañabera, ta zacuan cecartzen sateac. Chori gaissoac uste izan zuten guizon urá zala beren onguillaren bat, ta beren erruquiz malcoac ceriozcala beguietatic. Beren artean zorionez ceucaten chori pizcór, asco jaquin, ta beguiratu bat, ceñec ezagutzen cituen guizonaren asmo galgarriac, ta diotsate: Nere lagun maiteac, ez dabil gure onean piztadun sare ipinitzalle ori: negarra ta erruquia baño urra-

urrago du farrá gu gacusazalaco. Dauzcan sareac, dira gu barrumbean arrapatzeco; ta bere lepo-zacua, edo buru-jaquea, gu gordetzeco. Sinisnazazute. Nai baditugu buruac gorde, igues eguin bear degu bereala, ta orretaraco egoacquin gora igo, naguitasunari lecuric eman gabe. Bestela erorico guera bere sare asmo gaiztoz zabalduan. Antziñatic daquizquit onelacoen asmoac: bein baño gueiagotan arquitunaiz berac arrapatzeco irriscuan. Sinistucituzten Chori asco-ecusiaren esanac; igozuten landatic gora, egaaturic; larga zuten Chori-artzallea aoa zabalic bere sare ta buru-jaquearequin, igues eguin ciotelaco atsecabeaz.

Icasi bear degu Ipui onequin, artu bear dirala ondo nai digutenen, ta jaquitunen itz edo esan zucengarriac. Ez jaquiñac asco galdu ditu, ta gorde ere bai burua galtzetic, nor-baitec eracutsi dioelaco erorgarri, edo irriscua: Bada

*Lagun jaquitunari jarraitu*
*Bere itz onac pocic artu.*

## IPUI XL.

### *Guizon eguia zalea, Guezurtia, ta Chimoa.*

Guizon bic irten zuten alcarrequin lurra, ta erriac ecustera: bata zan eguia zalea, ta bestea guezurti utsa. Cebiltzan cebiltzan elducirán Chimoac ceuden baso batera. Chimo nagusi, edo besten buru becela zanac, esan cioen beste Chimo mendecoai. Ara non dacustazan guizon bi: zoazte, ta esan eguiozute, datocela nere aurrera. Eguin zuten mandatua Chimo batzuec, ta eraman cituzten guizon aiec Chimo nagusiaren aurrera. Eldu orduco oec, esseri zan bera aulqui eder batean: ipiñi cituen albo bietatic beste Chimo guciac, ematen ciola bacoitzari cegoquion toquia. Galdetu cion Chimo nagusiac guizon bi aietatic batari, ta au zan guezurtia: ¿Cer diote nigatic guizonac? Eranzun cion, derítzat, zu cerala Erregue andi bat, zure inguru ta aldamenetan daudenoc dirala, batzuec Jaun andiac, ta besteac Soldau aguintarien arte-

coac

coac. Guezurra bacerion ere, jaso zuelaco itz labañequin Erreguetzeraño, Erregueren icena aitu nai zuen Chimó nagusia, diotsa: Esan dezulaco eguia, emango zatzu sari eder bat. Arro arroric gueldítu zan Chimo nagusia guezurrezco andiqueriarequin; ta galdetu cion eguia zalea zan guizon bigarrenari, eta zuc cer diozu? Cion onec bere artean ¿guezurra esan duenari ematen badioe emen alaco saria, nolacoa emango ez zaio eguia esaten duenari? Eranzun cion bada: Zu, ta emen zauden gucioc cerate Chimo batzuec, ta besteric ez. Aserratu citzaion Erregueren icena enzun nai zuen Chimo nagusiari, ta diotsa: Cer? ¿zatoz oná nor gueran aguertzera? ¿Ez eman niri Erreguetasuna, ta oei andiquiena? ¿Chimo utstzat eman? Ill bear dezu, itz eguin ez dezulaco nere gogora. Ala ill zuten eguia esan zuena, ta saristatu guezurti andia.

Ipui onec salatzen ditu lurreco asco. Guezurti, itz labañ zaleac, biotz tolestua dutenac, igo oi dute sarri lecu goietara, aguindupetic aguintari izaitera; ta eguia zaleac, guezur gorrotocoac, biotz garbicoac,

coac, jó oi dute goitic bera, ta asco alditan guezurra da saristatua, ta eguia zapaldua. Baña

*Gorde zaite itz labañetatic,*
*Ta alde eguizu guezurtietatic.*

## IPUI XLI.

### *Astoa, ta Leoya.*

Asto batec basoan cebillela, topatu zuen Leoya, ta diotsa oni. Igo bear degu mendi gañera, ta eracutsico dizut, nola asco ta asco nere beldur diran. Goacen bada, esatendio Leoyac farrá eguinda. Igozutenean, asi zan Astoa arrantza sendoac eguiten. Soñu au enzun zutenean Baso artan ceuden Erbi, ta Cuiac (Conexos) irten zuten sasipetatic, ta artu zuten iguesa. Diotsa orduan Astoac Leoyiari, ¿ ez dacutsu nola nere beldurrac atera dituen igues eguiteco. ¿ Eranzun cion Leoyac ; Asto Jauna, Erbi ta Cuiai iguesa artu erazotzecò asco ta gueiegui da Chacurcho baten zauca. Ez zaite bada orrembesterraño arrotu. Eguingo banu nic emen orroa bat, ecusico ceu-

cenduque, nola icararen icaráz igues eguingo luqueen Cecenac, Basaurdeac, Otsoac, Artzac, Catamotzac, Mandoac, ta: ¿ norc ez? Cein guchi beldurtu nautzun ni! Cera bada Asto buru andico, ta belar lucedun bat baño gueiago?

Ipui onec esan nai du, farragarria dala ascoren arrotasuna, ecer eguin ecin, ta gauza ascotacotzat beren buruac saldu nai dituztela. Bada

*Izan gabe, burua andiriztea,*
*Da Asto arranzaria izaitea.*

## IPUI XLII.

### *Arranoa, ta beste Egaztiac.*

Arrano asco jaquin batec neque gabe janaria billatzea gatic, asmatu ta zabaldu zuen bere jaiotzegunean eman nai cioela mai, edo bazcari eder bat beste Egaztiai. Eldu ciran bera baño Egazti chiquiago batzuec Arrano prestu onen echerá; ta barrumbean zeuzcala, ichi cituen ate, ta irten bide guciac. Ill cituen banaca, ta bereaquin eguin ere bai egun ascotan bazcari ederrac.

IPUI

Ipui onec dio, Guizon andi, ta aberats batzuen bazcari emate, ta beste palagagarriac, dacartela guezur, ta asmo gaiztoa necazarien caltean. Au ecusten da vide charreco irabaci naietan. Esqueñico diozque aurrez diruac, erruqui balituzte becela; eman ere bai epèan gari ta artoac. Au da Arranoaren bazcari esqueñtzea. Baña beren bizcarretic guicenduco dira, escatuco diozquelaco emanac baño gueiagoac. Laster eguingo dira necazarien gari ta artoen jabe. Aberastu dira berac, oec argalduaz, coipe gucia jan dioelaco. Ala bada

*Erri ascotan dira Arrano guicenduac,*
*Ta Necazari gaisso, berac argalduac.*

## IPUI XLIII.

### *Leoya, ta Aiceria.*

Guicenduta cegoan Leoy batec, sinisérazo nai zuen eriric cegoala, ta eracarten cituen bera ecustera beste Abere ta Lauoñecoac, zalaco gucien buru, edo Erreguea. Ordea eltzea ta irenstea gucia bat zan. Elduzan leiza atarira asco jaquiña zan

Ai-

Aiceri bat. Diotsa oni Leoyac bere etzuntegui, edo oetic, atoz aurrera. Ez ni, eranzun cion Aiceriac. Dacustaz sartzen diradenen oñatzac, ezordea irtetzen dutenenac. Ala gorde zuen burua asco jaquiñez, ta beguiratua izanaz.

Ipui onec eracasten du, besteen calte, irriscu, ta gaitzetatic icasi bear degula guere gordevidea. Orregatican

*Besteen gaitzetan ipiñi beguiac,*
*Ta icusi nondic diran etorriac.*

## IPUI XLIV.

### *Otsó, ta Asto gaissotua.*

Jaquiñic Otsoac gaisso, edo eriric cegoala Astoa, joan citzaion ecustera sendatzeco estalgarriaz. Icutzen cion an ta emen, ta diotsa, ¿ non dezu miñ ? ¿ Non dago zure gaitza ? Eranzun cion Astoac bere Medicu, edo Sendaguille ederrari; zuc icutzen didazun lecu gucietan daucat miñic andiena. Orretan dago nere gaitza, edo caltea; ta esquerrac emango dizquitzut paquean bazaude. Zu becelaco Sendaguillac dira

dira gaitza irasteco obeac.

Ipui onec dio, guizon gaiztoac saldu nai dutenean on eguiña itz ederraquin, orduan ari dirala gueien gaitz eguiten. Bada

*Ez sinistu guizon gaiztoari*
*Guezurra dariolaco alacoari.*

## IPUI XLV.

### *Chindurria, ta Chirrisquia.*

Neguco egunean Chindurriac ateratzen cituen gari ale lurpean gordeac eguzquirá, barrumbean gueiegui ezcoturic usteldu ez citecen. Icusi zuen onetan Chirrisca soñulariac, ta escatu cion cer jan. Diotsa Chindurriac, nere laztana, ¿ cer eguindezu udan neguracó jangarria bildu gabe? ¿ Ez daquizu nola ni necatzen naizan mugonez guero goseric ez iduquitzeco? ¿ Alperrá izanda, naidezu iñoren bizcarretic vici? Eranzun cion Chirrisquiac: Ez nuen udan astiric izan bear eguiteco, ebilli nintzalaco erriric erri, bazterric bazter soñua jotzen. Ederqui, esatendio Chindurriac; soñuarequin uda zabala olgantzan igaro

igaro badezu, igaro eguizu negua danzatzen. Ala berotuco cerá; ala quenduco dezu gosea.

Ceimbat artzen ote ditu Ipui onec? eta cein ederqui eracasten digun Chindurriac igues eguiten alperreri! Gosea ill nai dute ascoc iñoren bizcarretic. Iduqui ere bai cer jan necatu gabe. Argatic

*Alperrác izango du goseá,*
*Ta soroa zalga charrez beteá.*

*Chirrisquia*, Cigarra: *zalguea*, cizaña.

## IPUI XLVI.

### *Pagoa, ta Cañaberea.*

Baso batean ceuden alcarren ondoan Pagoa, ta Cañaberea. Etorri citzaien egoi aice zatar ta sendoa, ta Pagoac ez zuen beratu ta macurtu nai, ta bai arpegui eman, ta jarqui aice gogorrari, esan ez cidin bera baño sendoagoa zala aiceá. Berriz Cañaberea macurtzen, ta obentzen citzaion, ta cerabillen aiceac bein batera, bein bestera, sendo egon ecinic. Diotsa Pagoac: O Cañabera argal, miazti, icaracorra!

ra! ¿Cergatic zabiltza zabuca ordi baten guisan, sendo egon ecinda? ¿Ez dacutsu nola ni sendoago naizan aice guciac baño? Emen ausitzen dira beren aserreac, niri zaburic eraguin gabe. Arpegui ematen dioet, ta ecin dute ecer nerequin. Eranzun cion Cañabereac: Ezagutzen det nic nere argaltasuna; ez naiz ni zu becein sendoa; ez det eracutsi nai ez dedanic. Alaco batean dator aice olatu ain portitz ta gogaitcarria, non dá ausi zuen guerri guerritic gure Pagotzarra, ta jó zuen berá, oñean gueldítzen zala Cañabera giratzallea. Lurrean cetzala Pagoa egoi-aiceac garaituric, diotsa Cañabera zutic cegoanac. ¡O Pago luce, lodi ta mardoa! ¿Nora dira zure arrotasunac? ¿Cergatic sinistu ez, cegoala zu baño indartsuagoric? Zure orri, edo ostro argui eguiten zutenac cimeltzen asi dirá; laster igartuac ecusico ditugu. Etorrico ere dira guizonac beren aizcoraquin jo dezulaco lurra, ta lotsa quenduta, chiquituco zaituzte, echetara eraman ta surtan erretzeco. Oña certara etorri dan zure arrotasuna. Ni macurtzen nintzaion aiceari, ta nago orain zutic calte gabe.

Ipui

Ipui ecin obea adierazotzeco guizon arro, astin, ta buruiritzicoai, nola gueroenean izango diran beratuac. Burua macurtzen dutenac, edo humillatzen diranac gueldituco dira zutic, calte gabe, aiceric gogorrenac garaitu ecin dituela. Cembat mutill ta guizon arroc, indarrac eracutsi naia gatic, iritziric sendoagoac diradela burruca ta maquillaca, garaituac izan dira, jo dute bea, lurpera gorputza eramateraño! O arrotasuna! Cembat galdu dituzun! Orregatic eguia garbia da, beratzen dana, goratua izango dala, ta jaiquitzen dana biotz arrotuz, beratua. Esopoc baño obetó jaquinbear dute eguia au Jesu-Christoren escolan aci diranac. Bada

*Ez inoiz burua goratu gueiegui,*
*Eroria izan ez zaitean beregui.*

## IPUI XLVII.

### *Mandacoa, Aiceria, ta Otsoa.*

Cebillen Mandaco bat mendipeco ibar batean belarra jaten; etorri citzaion Aiceria, ta galdetu cion onec: Nor cerá?

Eranzun cion Mandacoac: Zaldi grañoe galant bat zan nere Aita-aita. Ez dizut ori galdetzen, diotsa Aiceriac, ta bai nor cerán? Ni naiz lau-oñecoa, eranzun cion Mandacoac. Gogaitgarria cera, esatendio Aiceriac: esazu bada cein dan zure icena? Berriz Mandacoac, ez daquit nic ori: ill citzaidan Aita gaztechoa nintzala, ta nere icena aztu ez cidin, ichatsi cidan nere ezquerreco ta atzeco oin pean; ecin inoiz iracurri izan det. Zu cera iracurlaria, jasoco dizut oña, ta ecusico dezu cer dion, ta esango didazu. Aiceriac, asco jaquiña izanic, igarri cion cer asmo cerabillen Mandacoac; alde eguin zuen issillic, ta dio, era ederra Otso nere etsai tontotzarra galtzeco. Billatu zuen bada Otsoa zetzala querizpe batean, ta pocez becela diotsa. ¡O ero cenzu guichicoa! ¿ Cer eguiten dezu emen? Jaiqui zaite bereala, atoz nerequin ta eracutsico dizut non dagoan Mandaco gazt^e, guicen ta aragui samurrecoa. Ez det nic indarric itotzeco, zuc bai. Zuc illco dezu, ta bioc sartuco guera partillean. Sinistu cion Aiceriari, ta joan zan Otsoa berequin, Mandacoa cegoan ibarrera.

ra. Galdetu cion Otsoac, ¿zu nor cerá? Ni naiz, eranzun cion, Zaldi grañoe galant baten illoba. Ez diot ori, esancion Otsoac, ezpada, nor ceran zu? Ni naiz bada, eranzun cion Mandacoac, lauoñecoa. Gogaitgarria zaude, diotsa Otsoac: esazu zucen, ¿cein da zure icena? Ori ecin esango dizut, eranzun cion Mandacoac. Gaztechoa nintzala, nere Aitac ichatsi cidan icena atzeco, ta ezquerreco oñaren azpian. Iracurri nai badezu, atoz ononzago; jasoco dizut oña, jaquingo dezu cein dan nere icena, ta niri ere jaquin erazoco didazu. Otso zatar gatz gabe, ta tontotzarrac escatu cion oña iracurtzeco, ta Mandaco jaquiñagoac aurtigui cion osticada gogor bat, jozuen becoquiaren erdian; bota eraguin ciozcan beguiac, ta garuñac buru ezurra ausiric, ta larga zuen bertan illic. Aiceria bitartean cegoan celataca ecusteco certan guelditzen zan iracurte alacoa. Irten zuen pozez beteric cegoan guisatspetic, urreratu citzaion illari, ta diotsa. ¡O Tontotzar adin ta gatz gabea! ¿ Cerc sartu au ez iaquian gauzan? ¿ Nola igarri ez, gordeco zuela burua ire ortzetatic Mandaco



os-

osticariac ? Ez gaituc orain ire beldur, ez Mandacoa, ez ni.

Ipui ederra ezagueracitzeco berrichu jaquiñgurai beren zorotasun, ta tontotasuna. ¡ Cein ero ta buru caltecoa dan galtzeco, irriscuan jartzen dana !

*Ez galdetu bear ez danic,*
*Ez aditzeco nai ez dezunic.*

## IPUI XLVIII.

### *Mica egarritua.*

Egarritu zan Mica bat, ta irten zuen ur billa. Eldu zanean Iturrira, icusi zuen saconduta cegoala ura, berac anchitu ecin zezaquean becela. Estutu zan, baña ecusten du Nescachen batec ura eramateco ecarri zuen galleta bat, ordea ceiña ez cegoan erdiraño baizic urarequin. ¡ Au cer da ! dio. ¿ Egarriac ito bear nauela uraren ondoan ? ¿ Iturri sacondutic, ta galleta erdi betetic uric artu ecinez ? ¿ Cer eguin dezaquet ? Asmatu zuen ecartzea, ta bein banan botatzea galletara arri cosco, edo chiquichoac. Cembat geiago botatzen cituen,

tuen, ambat gorago igoten zuen galletaco urac, ta azquenic asmo onequin igoeraci cion berac nai becela edan cezaquean neurriraño.

*Asco dezaque escuac,*
*Baña gueiago buruac.*
*Garaituco dezu ecin eguiña,*
*Baldin bacera asco jaquiña.*

## IPUI XLIX.

### *Necazaria, ta Idisco gaztea.*

Necazari baserrico batec ceducan Idisco mardo, baña alper ta eci gabea. Uste izan zuen javeac ascoco zala ecitzeco uztartzea Idi paquetsu ta bearrera oituarequin. Icusi zuenean Idiscoac lepoa gatigu, asi zan orroaz, osticoca indarca, ta bota zuen uztarria ugalac urraturic. Icusiric Necazariac Idiscoaren uzutasun, ta eci eciña, lotu ciozcan oñac, ebaqui ere bai adar biac zorrotzac ceuden aldetic, ala adar motzequin iñori gaitzic eguin etzeguion. Uztartu zuen berriz. Idiscoac urratu cituen locarriac, ateratzen zuen lur autsa jabeari ichueracitzeco becela. An ciran

ran putzac, an osticocac, an orroac, an aoco pitsa. Aserratu citzaion Necazariari, ta diotsa: Idisco zoratua, eguin ciat aleguiña ecitzeco ire arrotasuna: ez ciagoc iretzat ez uztarri, ez ugal sendoric: laguna galtzeco asco aiz; lotsaric gordetzen ez dioc jaten ematen dianari. Alperric izango dira nere neque berriac; berdin ez ciagoc iretzat ecivideric. Bada nic quenduco diat betico, ta laster, ere arrotasuna; eramango aut Araguiteguira, ta Epallearen mallu gogorrac beratuco dic burua.

Ipui onec dio, gazte uzu, natu char, ta aciera gaiztocoac berandu, nequez, ta ascotan iñoiz ere eci ecin dirala. Cigorrada, aguiraca ta beldur garri guciac alperrac dirala. Idiscoa gorputztu, mardotu, ta cecendu bada, jaiquico da jabe beraren contra. Onelaco guizasemeac bacarric eci oi dira, edo presondegui gogorretan, edo obeto urcabean. Ala bada chiquichotatic eman bear da aciera ona; aurchoac cigorchoa ecusita beldurtzen diranean. Orregatican

*Gaizto gogortuaren ecividea,*
*Da urcabera eramatea.*

IPUI

## IPUI L.

### *Piztia ichusi, ta Guizon videaztia.*

Lidiaco aldamenetan dagoan, ta Atlos deritzon mendi batean ezagutzen dira piztia izugarri ta ichusi batzuec: buruetan dituzte Idiscoac becelaco adarrac; oñetan dirudite Auntzac, ta beste gucian daucate guizon nano, edo chiqui baten ichura. Eldu zan mendi artará lecu urrutietatic Erromes, edo guizon videazti bat. Irten cion esan degun becelaco Abere zatar, edo Guizon-piztiatu ichusiac, ceñari ematen dioen Satyroaren icena. Diotsa onec paquez guizon Erromesari: atoz beldur gabe nere echera: emango dizut mai ona; bada mendi onetaco aldats, ta elurrac necatuaz gañetic, eman izango dizute gosea. Echera eldu ciranean, guizon videaztiac escuac berotzeco estutzen, ta igortzitzen cituen bata ta bestea alcarrequin, egozten ere zuen aoco arnasea escu sabeletara. Maian jarri zanean, ecarri ciezten janariric ederrenac, ta sabela berotzeco catillu bete ardo berotu ta ciraquiana. Urbil-

du

du zuenean ezpañetara, erre ciozcan ardo iraquiten cegoanac, ta chut esanic, asi zan ardo gorituari putz eguiten. Bacecusan au Abere zatar ac, ta diotsa guizonari: ¿ au cer da? Gauza desberdin bi dacustaz zugan. Ao batequin berotu cinituen arnasa emanda escu-sabelac; ta ao berarequin puzca ta puzca otztu nai dezu ardo beroa. Guizon oquerra cera zu, bi aldetara eguiten dezuna, ta biotz tolestuaren jabea. Ez det nic nere echean iduqui nai zu becelaco guizonic. Zoaz bada nai dezun lecura, ta etorri ceran videtic.

Ipui onec arrapatzen ditu biotz ta ao bico guizonac, atzetic saldu, ta aurretic arpegui ona daucatenac.

*Ezda ez farra eguiteco,*
*Arpegui bi iduquitzea,*
*Batez paquea saltzea,*
*Besteaz auci emateco.*

# IPUIAC

## ITZ NEURTU, EDO VERSO Euscarazcoan.

### *ADIGARRIA.*

Gure Euscara ez dala eguiña lauco, edo zortzico batzuetaraco baicic, esango dute ez guchic. Jasoco dituzte Erdarac ceruraño, azpiratzeco Itzquera echecoa. Samaniego, ta Renteria Jaunac ots egui-ten dute, ipuiac verso, edo itz neurtuetan, ta Gaztelarren itzcuntzan arguira emanaz. ¿Norc, diote guero, euscarara ezarri, ta ambeste verso guisatan, ipuiac? Aitu diot cerbait daquianari, Samaniego ta Rente-riac jaquin izan balute Erdera becein ondo gure Eusquera, gatz oraindican obea idu-quico zutela beren ipui-versodunac. Gau-za oetan itzac ugariagoac dituela gure itz-querac gaztelarrenac baño. Bestetic, gure itzac badituzte otsidacoac (consonantes) ta abere contuac ondo ezagunac dira gure Baserri, ta mendietan. Ez da gaitza igar-tea, certan dagoan gure Poesia, edo ver-

so-

soguintzen laburtasuna. Dago bada bururic necatu ez dalaco; oitu ez diralaco Euscaldunac zortzico, ta laucoetara baicic. ¿ Ai baleude aitatu ditudan becelaco jaquitunac, Samaniego ta Renteria Euscaldun euscarara eman batzuec! Beste egunic ecusico luque gure Poesiac, edo versoguintzac. Asi bear da ta jarraitu, aurreratuco bada. Asieran ez dira gauzac osotuac ecusten. Gueldica eguiten dira aurrerapenac.

Esan nuen len verso ipuizco oiec ez dirala nere burucoac. Pillo andi bat dauca eguinda nere Osaba Jaunac; ta pillotic artuac dira emen ecusico diran guchi batzuec. Saiagarri bat da au, ta ez gueiago.

Esango ere da gure Eusqueraren lotsagarriraco, ez duela verso, edo Poesiac echeco icenic. ¿ Baña esan dezaquegu, ez duela inoiz izan? Arquitzen dira Erri onetan, ta paper chit zarretan, verso eusquerazco batzuec, anciñaco pergamiño lizunduetatic paper, guretzat zarretara, igaroac, ta an Poesiari ematen zaio *Ereciaren* icena. Aztu bada, ez egotzi Euscarari, ta bai Euscaldunai.

Ez

Ez arren erriertaric jaso bacoitzaren gogora itzac jocatzen ez badira. Guiputzcoan ere ez dabiltza berdin. Batzuec diote *maitea*, *paquea*... beste batzuec, *maitia*, *paquia*: aiec esatea nai dute *burua*, *lecua*... oec, *buruba*, *lecuba*; *duven*, *zuven*; *duen* edo *zuen*... *zoroa*, *eroa*; besteac, *zorua*, *erua*. Aurqueriac dira oec, ta guizon aituac ez dira guelderituco utsqueria oetan.

Beste gauza bat. Ipui ondo eguiñetan ez dira arquitu bear aurcho, ta Necazariac erraz adituco ez dituzten gauzac. Onetan uts eguiten dute, eguia badio Samaniego Jaunac, ipuilari güeienac. Eraqueria andia bestera eguitera, nola litzaquean Baserrico nescach batentzat erostea Dama mundutarrentzat bear bada gueieguiac diraden janci-pichituac.

Nola guciac ez daquiten eusquera ondo, adituac izan ditecen itzen batzuec, ipiñico da versoen oñean beren azalqueta edo esan naia.

## IPUI I.

### *Andra alarguna, ta Olloa.*

Andra alargunac echean
Ceducan zori onean
Ollo arrautzaria.
Zan bai ecuscarria
Egunoro ipintzea
Utsic gabe arrautzea.
Dio pocez bere artean:
Ematen diodanean
Aldi batez artoa
Arrautza egunecoa
Badit beti ipintzen;
¿Cer baldin eramaten
Badiot nic bi bider?
Arrautza bat ez da ecer:
Emanic jan aldi bi;
Eguingo ere nau ni
Andi biren jabe;
¿Nola asmatu ez duve
Gauza onelacoric?
Ala ero eroric
Guizendu zan olloa;
Ta arrautza batecoa

Alpertu zan gucia.
Beti izan da eguia:
*Gueiegui billatzea*
*Ecer gabe guelditzea.*

## IPUI II.

### *Otsoa, ta Anchumea.*

Aunz bat zijoan basora
Anchumea echean ichiric
Oculluban ondo gorderic
Irten ez cezan campora.
Contu, diotsa; ez irten,
Biurtu nadin artean:
Eta iñor bada atean,
*Oles*, *oles* eguiten,
Ez idiqui beingoan:
Zaude iratzarriric,
Ta beguiac idiquiric,
Ni an ote nagoan.
Zelata dago otsoa
Esan ciona aditzen,
Baña goseac estutzen
Zuen aguitz gaiztoa.
Anchume araguia
Dio, da chit samurra;

Baña bear da guezurra
Neretzeco *Guiberriá*.
Dijoa issillic atera
Aunz amaren soñuaz,
Asmo gaiztoz artuaz
Ta onela arrapatzera.
Anchumeac du gogoan
Bere Amaren esana
Ascó matéz emaná
Basora zan ondoan.
Ala atearen cirritutic
Daramazqui beguiac
Ta eracusten dio arguiac
Cegoan lecu ezcututic,
Zala bere etsai otsoa,
Ez bere ama maitea.
*O malmutz gosęberea* !
Cein aizan i gaiztoa !
Ala gogoz cortatic
Diotsa bere etsaiari.
Eta ¿cer ipuiac gazteari ?
Enzun beza bertatic.
*Artu bear dira gogoan*
*Zar jaquintsuen esanac*
*Calte artuz eman diranac.*
*Ez utzi iñoiz alboan.*

Cir-

*Cirritua*, resquicio.
*Guiberria*, ganado lanar.
*Malmutza*, taimado.
*Calte artuz*, por experiencia del daño.

## IPUI III.

### *Lapurrac, eta Ollarra.*

Eche batean lapurrac ciran sartu;
Nai cituzten bazterrac aztertu
Goi goitic eta berá;
Guero ere ez zuten ecer atera:
Ollar zar bat bai. *Ce izacaria*!
Baña lapurrentzat ona da gucia.
Artu dezagun, diote, *lumati ederra*,
Gangor gorri, *allatsu*, buru arroa
Araguiz lodi, mamintsu, mardoa,
Guretzat izango da gaur eperra.
Ó nolaco aparia!
Gozatzeco sabel goseberia.
Baceramaten ollarra iltzera,
Eltze batean egosten ipintzera.
Eman cion ollarrac negarrari,
Biotza biguñtzeco lapurrari.
¡ Certaco nauzute ni, ó guizonac!

Ezpaditut aragui samur, ta onac!
  Ordea gucia alperric,
Lapurrac ez dutelaco erruquiric.
Ollarrac jardun ta jardun ber berá,
¿Certaco naramazute ni iltzera?
Artu baninduzute ollasco nintzanean,
Samurra izango nintzan ezpañean.
Ill didilla ollanda biguñ ta gozoa.
Ollar zarra, ce *janari zozoa.*
  Nacutsute zarturic,
Gogor, gauza ez, ta zaildurie.
Ez naiz vici ni iñoren caltean
Guizonac esnatzen ditut gavean.
Vici naizala banaiz cerbaitaco;
Illtzen banazute, ez ecertaco.
Nere soñua da chit aitua
Ta iratzartzeco loac artua.
  *Eguitecoaren bizarra*!
Gangor andiarequin aiz gangarra.
Euc eman dec iltzeco erabaquia,
Ire lepoa izateco ebaquia.
¿Dituala, dioc, guizonac iratzartzen,
Ta jaiqui ditecen gavaz, soñutzen?
¿Ori berriz lapurren aurrean?
Galdua aiz gaur gure *batzarrean.*
Eroa, orretan ciagoc gure caltea:

Ire-

Eroa, orretan ciagoc gure caltea.
Iretzat ere bai orain iltea.
*Gaiztaguiñac ez du nai arguiric,*
*Ez da ere izaitea ezaguna:*
*Oquerreraco nai du illuna,*
*Ta ez iduquitzea ecuslaric.*

*Ce izacaria*! Frase. Que bella cosa!
*Lumati ederra.* El bien-emplumado.
*Allatsua.* Cola poblada.
*Janari zozoa.* Frase. Que precioso alimento!
*Eguitecoaren bizarra*! Frase. Bella azaña!
*Batzarrean.* En el Concilio, ó Junta.

## IPUI IV.

### *Baserritarra, ta Basaurdea.*

Baserritar bati basaurdeac
Eguiten cizcon bere soroan
Calte asco, gari, ta artoan,
Ta iguestzen cion abereac.
Cer? dio: Ez aut nic artuco,
Ta noiz edo noiz escupetuco?
Etortzen citzaion gavaz sarri,

Alaco bateau escuac cizcon ezarri:
Bai bere zorionean,
Ipintzen zuela bere mendean.
Ebaquitzen dio ezquer-belarria,
Largatzeco ala ezagugarria.
Bidaltzen du bada ala basora,
Biurtu ez cidin berriz sorora.
Sendatu citzaionean zauria,
Ezpazuen ere lengo belarria,
Guerta citzaionaz azturic,
Ecusi zuen soroan sarturic.
Iguesa artu cion;
Arrapatzeco astiric eman etzion.
Beste gavean dago celatatzen,
Ta dacus artoac lurreratzen.
*Belar-bacoitzac* marra marrá,
Nola zaldi batec garagarra,
Apurtzen zuen bere ortzetan,
Biurtzen zuela iriñetan.
Baserritar gaisso caltetuac
Egotzi ciozcan berriz escuac.
Ebaquitzen dio belarri escuiçoa
Largatzeco ala *belar-motzecoa.*
*Gurrinca* dijoa au basora,
Odola ceriola, ez sorora
Gueiago joateco asmoaz.

Ai ai! dio. ¿Cergatic zoaz
Calte eguitera bazterretan?
¿Ez dezu arte ale, *lur arbietan*
Cerequin gosea ase ugari?
¿Certaco baserritar gaissoari
  Galdu zuc icerdia,
Ta bere urte gucico janaria?
Sendatu zan berriz belar motzecoa,
Ta gogora citzaion arto sorocoa.
Banoa ará, dio, naiz ariña,
Chacurraquin jostatzera eguiña.
  Ez bada beldurric,
Jateco bear ezdet belarriric,
Dijoa gueldicho soro maitera:
Belarriac daramazqui echera,
Otsic ote dan ango atean,
Ez baldin bazan bera bitartean
Artoz asetzeco atseguinez,
Ez izuz, icaraz, ta beldurrez.
Baserritarra orduco soroan
Bere morroiaquin celata cegoan.
  Ala dute arrapatzen
Ta locarri sendoaquin gatigatzen.
Urde zatarrac ordu ain estuan,
Esquintza ederrac eguiten cituan.
Enzuteric ez zaio ematen

Bai berriz aserrez esaten:
  Calte guille gaiztoá!
Cergatic izan aiz ain eroá?
Ecusi dec nere oneguitasuna,
Nic ere bai ire gaiztotasuna.
Ez ciagoc barcacioric,
Ez iri vicitza largatzeco gogoric.
Erori aiz irugarrenez gure escuetan,
Burnia izango dec ire saietsetan.
Au esanaz iltzen dute beingoan,
Artu ere bai morroiac *lepoan*,
Poz pocic echera eramateco,
Ta auzoetan berri onac emateco.
  Ala biaramonean
Ipiñi zuten zatarra zaldi gañean.
Artzen dituzte *burni zulatuac*,
*Su-auts* ederrarequin prestatuac.
Abiatzen da *sutumpa* gogórra,
Esna cezaqueana ordi concorra.
¿Cer da au? diote errico mutillac,
Atso, agure, ta umecho sotillac.
Asitzen da berriz su-aice soñua:
Alde ascotan ecusten da lañua.
  Jesten dirade errira,
Basaurde zatarrari daude beguira.
Dijoaz andiqui baten echera,

Ichusi arequin esquintza eguitera.
Dacuste, baña arriturric,
Ez zuela basaurdeac belarriric.
Biltzen da ara guizon teguia:
Ateratzen ere zaie zaraguia.
¡An bai zala atseguiña!
Ardoaz onratzen *calteguiña*.
Ebaquitzen diote burua:
Gende gucia dago arritua,
Ez zuelaco *garuñic* aguiri;
Ecin ere cioten igarri,
Certan cegoan ipuia;
Ote zan guezurra, edo eguia.
Ez zaitezte, jaunac, arritu:
Dacutsutenaz ez miraritu:
Dio batec asco jaquiñic,
Ta ipuia eguiaztu nairic.
Nola muñac iduqui
Basaurdetzarrac? belarri bi,
Galdu ezquero, badia sorora,
Ecarri gabe leena gogora.
*Gastiguac ondutzen ez duena*
*Da muñgabe, ta zoruena.*

*Belar-bacoitza.* De una sola oreja.
*Belar-motza.* El desorejado.

Gur-

*Gurrinca*, ó *urrumizaca.* Gruñendo.

*Lur-arbia.* Navitos subterraneos, alimento apreciado por el jabali.

*Calteguiña*, ó *calteguillea* se usan indiferentemente, como *auspoguiña*, ó *auspoguillea.*

*Lepoa*; unos aplican esta voz al cuello, haciendola synonima con *iduna.* De aqui *lepoa ebaqui.* Otros la aplican al hombro, y la synoniman con *solbardea*, *besaburua*, *soña.* Asi dicen: *Gurutzea lepoan eraman zuen Christoc.* Los Poetas tienen mas amplas facultades para variar, porque está escrito,

Pictoribus, atque Poetis, *quidlibet audendi semper fuit æqua potestas.*

*Burni zulatuac.* Cañones de escopeta.

*Su-autsa.* Pólvora, ó polvo inflamable.

*Sutumpa.* Ruido del fuego, ó tirotéo.

*Garuña.* Otros dicen solo *muñá*; pero es mas descriptiva la primera, porque significa la sustancia, ó tuetano de la parte superior, *garai-uña*: *muñá* no especifica el parage. *Uñá*, *uná*, ó *muñá* tienen el mismo significado.

La narracion difusa de esta y algunas otras Fábulas en Poesía, no debe ser censurada. Se ha procurado agradar á los rústicos habiendo pintado las circunstancias de los hechos segun uso del país. Hace tambien parecer mas fecundo á nuestro idioma, y semejante ampliacion hace mas eloqüente la narracion.

Para no incurrir en el gran vicio del monotonismo, que adormece los sentidos, y hace enfadosa la oracion mas eloqüente, quando, por el contrario, la varia armonia deleyta el ánimo, y aviva la atencion, se ha procurado la variedad de metros, sin echar en olvido nuestro comun *Zortzico*. Pero es preciso confesar, que los versos endecasilabos pareados con la alternativa de pies quebrados, ó de siete sílabas, tienen no se que mayor y mas agradable armonía. Con todo será muy fastidioso este metro, si no se lé con sentido y expedicion: ¿y habrá muchos bascongados que asi los lean?

## IPUI V.

### *Chacurra, ta Catua.*

Chacur-catuac, norc sinistu ?
Ceuden bein erretillu batean
Alcarrequin jaten paquean,
Ta ez ciran batere *chimistu.*
Echeco jaunac bertatic
Auzocoai, eracusteco cergatic,
Deituric, abiatzen zaie esaten,
¿Nola ez dituzute ecusten
Etsai gogor bi paqueturic,
Eta mai batean alcarturic ?
¿Chacur, ta Catua adisquide,
Balira becela senide ?
Cer eguin ez lezaque ecanduac,
Eta gauza batera oituac ?
Beazuna bera eztitu:
Guizon sutsua otzitu:
Aserre erraza bigundu:
Oquerrena ere zucendu.

*Chimistu*, chispear.
*Otzitu*, otros *oztu.* Asi Larramendi, y la consonancia pedia *otzitu.*

## IPUI VI.

### *Cata-motza, ta Zacurra.*

Caiola burnitsuan
Catamotz *uzua* cegoan sarturic
Cecusala chacur bat pozturic
Cate gabe, jolas, ta *parlanzuan.*
*Desberdintasuna* ecusi zuenean,
Sartu zan catamotza aserrean,
Cerua besoz nai du arrapatu,
Eta ceduzcan burniac urratu.
Diotsa bada deadarrez,
Biraoz, araoz, eta aserrez:
¿Nola ni ain itzaltsu ta ariña izanic
Naucate emen estu, ta gatigu?
Cera nerequico argala zu,
Ez dezulaco nere atzapar, ez zañic.
Dezu ala ere aldi gozagarria
Ará, ta onacó vicitza ibiltaria.
Berriz ni atsecabez,
Burni artean naucatela beldurrez.
Ondo da, dio chacurrac, ez arritu:
Egotea zu orrela, ta ni *ascatu*:
Cera atzapartsu, ta odol zalea,
Ni guizon, ta echeen gordetzallea.

¡ Ez-

Ezpaciña ere alacoa,
Ecin izan nindeque zu becein gaiztoa.
Sartzen diezu guciai beldurra:
Eguia da au, ta ez guezurra.
*Certaco dirá indar, ta putzac lurrean*
*Izango badirá beti gure caltean?*
*Cembat obeago bigun izaitea,*
*Ta biotz erruquitsua aguertzea?*
*¿Ez dezu nai catearic?*
*Ez bada inoiz eguin calteric.*

*Cata-motza.** Es especie de Tigre. Se vé alguna rara vez esta mala fiera en estos paises, causando grandes estragos en ovejas y ganado bacuno. La mayor corpulencia de los legitimos Tigres, no impide el que á estos se aplique el mismo nombre.
*Uzua.* Fiero.
*Parlanzuan ibilli.* Andar en diversion. Es locucion muy usada: *Chacurrac dabiltz parlanzuan.*
*Desberdintasuna.* Desigualdad.
*Ascatú*, en adverbio, sueltamente.

## IPUI VII.

*Catu Eizari basocoa Zortzicoan.*

1 Anciña erri batean
Vici zan Catua,
Gueldi egon bearrez
Guciz gogaitua:
Iguesá artu nai du
Echetic basora,
Igarotzeco egunac
Bere gogo osora.
2 Dio ¡ cer da echecoac!
¿ Emen nic sarturic?
¿ Egon bear ote det
Beldurréz beteric?
Sucaldera banoa,
Eche nescameac
Nereganatzen ditu
Bere aserreac.
3 Illiti ta berzunac
Dizquiz aurtiguitzen,
Nere bizcar ezurrac
Asco mimberatzen.
Au da ematen didan
Egueneco-oguia,

Ala artu dezadan
Gambara bidia.

4 Narabilte echean
Sarri *illariaz*,
Lapurreta guciac
Niri egotziaz:
Asmo chatar onequin
Beti naute zaitzen;
Oramayan oquelac
Dizquide gordetzen.

5 Alaco baten bada
Dia nescamea
Beste toqui batera;
Baña sucaldea
Chacur baten *pecora*
Didate largatzen,
Utzi nai ez didala
Onec urreratzen.

6 Catuac bear dute
Vici gambaretan,
Billatu janaria
Eche saguetan:
Suac argaltzen ditu,
Ta gucîz macaldu,
Alá gure missocho
Gucia da galdu.

7 Au da enzuten dedan
Soñu beticoa;
Guero estaltzen dute
Contuz *lapicoa*,
Arrapa ez dezadan
Gueli egosia,
Ta beren janaritic
Asé nic gosia.
8 Egun paquezco gabe
¿Nor vici onela?
¿Ez da neretzat obe
Igues bereala
Mendira eguiteá,
Cer jan billatzeco,
Sabel ain muurituá,
Noiz bait betetzeco?
9 Catuac bere-asmoa
Artu zuen laster,
Eizan arrapatzeco
Ollagor, ta eper,
Baso satorrac, eta
Erbi gaztechoac,
Birigarro, zozoac,
Beste chorichoac.
10 Basoan artu zuen
Lecu ezcutuá,

Ala dago gorderic
Gure bizartsua:
Cateac egozteco
Pizti, ta egaztiai,
Bidea zabaltzeco
Este cimurtuai.

11 Laster zan bai guicendu
Misocho gurea,
Mendian ez du izaten
Echeco goseá:
Dio: Au janaria!
Samur gozatsua,
Errian vici dana
Da chit zoratua.

12 Catu eremutarrac
Ez du nai belarric,
Ez arán, ez mispilla,
Ez baso-sagarric:
Aragui samurretan
Dago coipetua,
Baraua daducala
Betico aztua.

13 Cebillela onela
Pozez zoraturic,
Dijoaz Eizariac
Su-armac arturic:

La-

Laguntzat dituztela
*Eiza-zaucariác*,
Billatu, ta iltzeco
Epér, ta erbiác.
14 Usaica cebillela
Chacur bat lurrean,
Beingoan gueldítu zan
Sasitza aurrean.
Cegoan an *Padarrá*
Issill, ta gorderic:
Chacurrác nai ez zuén
Áldatu toquiric.
15 Eizáriac diradé
Ingúrura biltzén,
Ollagór, eper, edó
Erbiac irtetzén
Ote zuen sasitic,
*Suá eguiteco*,
Illic, escuz artutá
Brujacaratzecó.
16 Uste uste gabeán
Dacuste catuá,
Sasipe saconduan
Gucia sartuá:
Ceuzcala aldamenean
Ezurrac ugari,

Zala

Zala calteguillea
Cioten igarri.
17 Amorrúz, ta ernegúz
Dute arrapatzen,
Locarri sendoaquin
Guero gatigatzen,
Esaten diotela:
Eiza-gaitzallea!
Emen galdu bear dec
Ire vicitzea.
18 Guizonac, cer eguin det?
Diotse Catuác,
Aguer-zaquizquidatzu
Nere becatuác:
¿Baldin zuen laguná
Banaiz ni onetan,
Certaco ipintzea
Gaur ni cateetan?
19 Aguintaria bada
Calteguiñ andiá,
Nola cigorperatu
Lapurcho chiquiá?
Lapur ertutzalleac,
Badirá lapurrác,
Irentsico dituzte
Mami, eta ezurrác.

Illa-

*Illariaz erabilli.* Traerle á uno persiguiendole de muerte.

Norbaiten *pecora* egon. Estár á la custodia de alguno.

*Lapicoa*, otros *Eltzea.*

*Eiza-zaucariac.* Perros de caza.

*Padarrá.* Hermitaño, ó el Solitario: voz muy usada entre los rústicos.

*Su eguin.* Disparar la escopeta. Asi se explican nuestros *Guizones.*

*Brujaca*, viene de *burujaquea.*

## IPUI VII.

### *Astoa, eta Otsoa.*

AStoac bizcar ezurrean
Ceucan zori charréz zauriá:
Zan icusquizun negargarriá
Belatzarrac equincionean:
Alperra osticadea,
Eta arrantza gogorrac eguiteá
Astazaia beguira dagó farrá
Ta belea jaten auqueráz.
Gauza errucarria!
Astoaren ez egotea erruquia:



Ecus-

Ecusten cegoan larpetic Otsoa
Cein larri cerabilten Astoa:
Astazaiac bereaz ez erruquiric
Ez belacharrari igues erazoteric.
  Zori gaiztocoa ni,
Bere escupean banagui ipiñi,
Au cion Otsoac, ta ez gaizqui;
Bada ondo aztertu badidi
*Guizon gaiztaguiñ otsotuac*
*Daude Ipui onetan sartuac.*
*Beti vici bear dute oec icardz*
*Ez jolasetan, tá algaráz.*

AZQUENA.